

# Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin

IBON MUÑOA ARIZMENDIARRIETA




EGILEA:
**Ibon Muñoa Arizmendiarrieta**

Centro Penitenciario Córdoba
14.014 Córdoba


Ibon Muñoa 2000ko urrian atxilotu zuten. Harrez gero preso daukate: Valdemoro, Kordoba, Burgos, Langraitz, Puerto I eta, 2014ko martxotik hona, Kordoban.


AZALEKO IRUDIA:
**Mikel Zarrabe Elkoroiribe**

**www.literaturakoadernoak.org**







ISBN: 978-84-942777-6-4.
LEGE GORDAILUA. DEPÓSITO LEGAL. DÉPOT LÉGAL
SS 458-2016.
INPRENTA: IRRINTZI. Bilbo.
Auzolana.

## SOLASEAN

Kaixo Ibon:

Hirugarren bertso-poemen libururako atarikoa idaztea proposatu zidatean. Pozarren. Kirioak berehala hituen abian burmuin-zokoren batean zer eta ze moldez idatziko. Eta hara non hurrengo egunean bertan hire gutun bat. Nire berehalako erabakia: "gutun bat idatziko jetzat". Eta hemen natorkik.



Gutunean gogoratzen duk 45 urte bete direla Frankismoaren aurkako Burgosko epaiketa burutu genuenetik: 12 urte hituen hik, ez omen huen ulertzen zer gertatzen zen, baina abenduko 3an etxera hindoala manifestazioaren atzealdean joan hintzen etxeko atarira iritzi arte, eta tiroak entzunda, Guardia Zibilaren eta Polizia Nazionalaren mugimendua ikusita, zerbait larria gertatzen zela konturatu hintzen, baita ere diok ate ostetik Radio Paris entzun huela, bertan Marion aldarrikapena eta besteok Eusko Gudariak abesten. Hire militantziaren hastapenak izan zirelakoan nagok. Militanteak ez dituk berez sortzen. Bizitzak jartzen gaitik egoera eta ataka ezberdinen aurrean. Hartzen dugun jarreran zagok gakoa. Lehen pauso hori duk erabakigarria, mugarria, paso eman edo bizitzak botatzen digun enbidoa, sarri hordagoa, jaso, "euki" hori duk

funtsezkoa. Beste dena pausoka-pausoka zetorrek, azkarrago edo mantsoago, baina etorri etortzen duk. Hori duk denon historia, hirea eta nirea ere. Enbido edo hordago harez gero ametsaren itzalpean bizi izan haiz, albo-bidetan galdu gabe, azalean tatuatuta daramak ordutik lorpenaren konpromisoa. Eta haukaten mendeku-esparru hori eta bertan emaniko bertso sorta oparoa duk hire jarrera eta norabidearen lekuko. Merezi izan diate hainbeste kartzela, hainbeste sufrimendu, ezinbesteko beldurraren eta etsipenaren hobetan galdutako hainbeste lagun, trukean askatasuna dagoelako, bizipen, sentipen eta helburu hautsezina den askatasuna, oraindik ez datorrelako ez dela dirudiena, baina dena, eta datorrena. Orain arte. Eta orain. Baina bihar? Bihar ere. Hori duk ameslarien itxaropena, borrokalarien segurantza, hire bertsoei darien bizipena.

Iragan udaran herri txiki galdu ezberdinen erakusketa bat ikusi nian: burujabe izandako estatu, nazio, monarkia, errepublika, sultanerri… 30 bat izango hituen, mundu zabal osokoak, beraietako askoren bandera, uniforme, pasaporte, moneta, seilu… Perejil irla ere agertzen huen, izana duk nonbait tarte batez independente edo gutxienez autonomo. Hau dena aipatzen diat bazelako bitxikeria bat: Kanadako neska batek, bere etxeko gela bilakatu zian estatu

independente, 12 metro karratukoa luze-zabal, estatu bati zetxezkion osagai eta baldintza guztiekin, 12 pertsona omen zizkian herrikide. Hire liburuki berrirako bertso-poema sorta irakurtzen ari naizela garunetako kiribilen batean zereko zera zerabileat: hik ere heure nazio estatu edo errepublika propioa eraiki duk, ziega hori zaik Nazio Estatu edo Errepublika, hire-hire propioa, metro karratu ezin murritzagokoa, isolamendua dela-eta biztanle bakarrekoa eta bisitaririk jaso ezinezkoa, aldikako inbasoreena ezik. Baina hire Nazio, Estatu edo Errepublika duk. Euskara bertako hizkuntza nazionala. Hire poema eta bertsoak dituk mugarri, bandera, pasaporte, moneta, seilu, uniforme eta ezaugarri. Eta haramaten tokira haramatela, hagoen tokian hagoela, ziega biluzienean ere, biluzten bahaute ere, hire Nazio Estatu Errepublika propioa izanen duk hagoen zokoa. Aldi berean, aske izan nahi duen herri baten zati haizelako. Ezin hautelako ideia, oroitzapen, sentimendu, bizipen eta deliberamendu irmoaz biluztu. Inon ez haiz atzerritar. Ziega berri batera ekarri haute bertsoon urtean, Puertotik Cordobara, eramanen haute ere auskalo nora, baina hi ez haiz horkoa edo hangoa, hor nahiz han bahaute ere, edonora haramatela ere. Burdina goriz zigilatuta daukak herri honen ikurra eta ezin diate ezabatu. Publikatutako 450 bertso eta poemok irakurtzea besterik ez zagok.



Kartzelan gatibu 15 urteak gogoratzen dizkidak. Bertsootan ere hizki kolpez zizelatuta zeudek 15

urteok. Herri aske batez egin huen amets eta orain ametsen atzerrian, gorroto hauten morroi artean haukate, etsaiaren erpekada zaurtzaile mingarriak jasoz, debekuen labirintoan bidea ez galtzeko eginahaletan. Kartzela inguruko bertso sorta luzean, marrazten duk kartzela, sakabanaketa, isolamendua, bakardadea, sentipenak, bizipenak, gogapenak, oroitzapena… Bertso eta poemotan zeudek hire lagunak. Hausnartuak urteko gertakizun nabarmenenak. Gogoan presokide auzoak, askeak, nola ez gaixoak. Horma horien haraindi eta honaindiko pertsona ospetsu, ezagun edo apal eta ia ezezagunen gomuta. Hire barnean ez beste inon gorde ezin haizen zirrikituz betetako atzerria arren kartzela. Luzea duk etsaiaren itzala, argirik ez dagoen ziegan ere. Agian bertan luzeena. Baina ez duk begirik ixten, aldaketa egarriz begiratzen diok gizarte zabalari ziega murritzeko bakardadean: ez haute itsutu, ez haute mututu, ez haute etsipendu… Hire ziegako bidaiak dituk bertso eta poemok. Hormez haraindiko eta hire barrendiko bidaiak. Hire egutegiko egun bakoitzeko laukiak izen bat, oroitzapen bat, salaketa bat, bizinahi bat, esperantza bat zekarrek. Bakardadean, isiltasunean… berrituz berpizten hautenak. Ontza eta saguzarrak azaltzen dituk zenbait bertsotan, baina herrira jauzia egiteko tranpolina besterik ez dituk, inola ere ez gaueko amesgaiztoak. Hemen habil gurekin Urko, Kalamua, Ixua, Arrate… baita Pirinioetako ibilbideetan ere: Irati, Orhi… Gizarte honetako arazo nagusien kronika ere badituk hire bertsook: feminismoa, ebola, etorkina, zergak, gerra eta indarkeria ezberdinak, Nigeriako neska

bahituak… Hire altxor preziatuen gordailu oparoa irekitzen diguk.

Hitza, hire bizitza eta arma bilakatuta. Denbora, astia, ematen omen dik kartzelak, baina kuraia duk batez ere kartzelan behar dena. Idazteko ere. Agian batez ere. Heurekin aurrez-aurre jartzen hau kartzelak, izugarrizko erronka duk haizenari erantzun behar hori: hor bai dagoela garaile edo garaituaren alternatiba bakarra. Kartzelak bere erritmo propioak markatzen dizkik, kartzelak bere bizitza propiora behartzen. Presoak berak ere, baina, bere kadentzia bere-berea dik. Zementuzko itsaso baten erdian igeri egitea duk kartzelan idaztea, edo nabigatzea, hitza txalupa eta arraun. Hire bertsoon eta poemon egutegiak ere erritmo propioa dik, ez duk kanpokoon kontaketan oinarritzen. Kartzelak mila baldintza ezberdinez zedarritzen dik bizitza: Puerton hasten duk bertsoon sail bat, 213ko irailaren 13an, eta 14ko otsailaren 23an bukatzen, aldatu hinduen arte. Kordobakoen aldia 2014ko matxoaren 2an hasten duk 2015eko martxoaren 31an bukatzeko. 39 bertso dituk Puertokoak, 102 Kordobakoak, Liburukoak orotara 141. Mendiburu eskultoreak esaten zian: datorrenean tailerrean harrapatu behar duela artista inspirazioak, lanean alajaina, geltokian zain ez dagoenak trena gal tzen duela, alegia. Norbaitek esanen dik ezinezkoa zaiola presoari tailerretik alde egitea. Kartzelan ere norberari eskapo egiteko mila zirrikitu, estakuru eta aitzakia zeudek. Idaztea, artea delarik, edozein dela generoa, lanaren ondorioa duk. Hi beti geltokian hagoela zirudik, langi-

le nekaezin. Horrek garatu dik hire bertsogintzarako sena, ahalmen literarioa. Borondatea behar duk idazteko eta ikasteko. Kartzelan, edonon adina, edo gehiago. Agian defentsa mekanismo bat jarri huen abian idazten hasi hintzanean, baina jada harago joan duk hire idazte-jarduera. Idazle egin hau kartzelak.

Ez nauk hasiko hemen begirada kritikoz hire bertso eta poemak miatzen. Hain duk erlatiboa bakoitzaren iritzia. Bakoitz horren izaera, osagai, baldintzen, eta, nola ez, modaren araberakoa duk gehienetan idazlearena ez ezik, poema eta bertso bakoitzaren xendra, kritikoarena ere. Ez darabilk beste zenbaitzuk adina irudi eta metafora, ez diek ematen filosofoago edo pentsalariago diruditenen gain-hegazkadako goi-begirada. Agian bai. Niretzat bai. "Ni ez naiz hemengoa" izenburutu zian Sarrik kartzelan idatzitako liburu bat. Hi ez haiz horkoa hor bahaute ere, ez haiz hangoa edonora haramatela ere. Hemengoa haiz hi, hire herrikoa, Eibarkoa, Euskal Herrikoa, mundu zabalekoa. Agerikoa duk hori poema eta bertsootan. Pultsua hartzen saiatzen haiz gizarteari. Hire baldintza eta ahalekin. Herri honi atxikita jarraitzen duk, -"hain urruti eta hain hurbil" zioan aspaldiko kantu hark-, zuzen eta hertsiki herriari lotuta, basatzan gabiltzanon pena eta pozak ehoz. Bertso eta poemok irakurriz azken urteko herri honen gorabeherak aurkitzen dizkiagu. Herri honen arazoei buruzko hausnarketa dituk. "Parisen bizi naiz" duk Koldo Izagirreren azken poema liburua, Euskal Herria bada ere bere poemon muina.

Hala dituk hireak ere, Puerton edo Cordoban arren. Agian ez darabilk egitura ponposoegirik edo sinonimoen hiztegian bildutako hitz agian aproposagorik, edo errima bihurriagorik. Zenbaitzuk, aldiz, bere irudi distiratsu, esamolde bikain, hitz eder eta perpausa potoloekin izartegian bezala zebiltzak lurraren biran, espazio-ontzi batean bezala, gainbegiratuaz so eginaz gure lur arrakalatu honi, lurreratu gabe. Herri honen eta herritarron poz, amets, ahalegin, ahal eta ezinez ari haiz. Gizarte honi hertsiki lotutakoak dituk hire bertso eta poemak. Gu bakoitzaren hausnarketarako ataka zabaltzen diguk, baikortasunari leihoa. Hori duk garrantzitsua, hire bertsoei darien ekarpen nagusietako bat.



Kanpora atera denak baino barruan dagoenak behar omen dizkik hurbiltasuna, animoak, txera, eskerrona, besarkadak, aurreskuak, lore-eskaintzak, irakurri diat: hik heuk eskaintzen diguk hori dena eta gehiago bertso, poema, eta batez ere hire jarrerarekin, barrutik kanpokooi. Joxe Austin Arrietari irakurri zioat: "Han izanik hemen haiz", eta "Gugan dirakik, gugan diraukek". Eskerrak guztiagatik. Hirekiko eskerrona eta aldi berean omenaldia duk hirugarren liburuki hau. Segi ezak idazten, poeten uharan, bertsolarien abaroan, bizirik hagoela esaten diguk, arnasa betean, inola ere ez arnasbeteta, arnas luzekoa baihaiz. Itxaropena eta bizipoza oparitzen dizkiguk. Nire lanmahaiko ertz batetan zagok iazko liburukia, liburuen apalera pasako duk hirugarrena eskuratzen dudan

unean. Gogoko diat poesia eta badiat poema liburu sorta xume bat: abizenen ordenak hala aginduta, Miranderen ondoan tokatu zaik egotea.

Nonbaiteko toles-gune batetan zimiko egiten zidaan galdera nian bertsook irakurtzean: eguzki faltarik ez dik izango patioan, baina ikusi ote dik aspaldi ilargi betea? Azken-aurreko bertsoan eman didak erantzuna. Hire gordailua zabaldu diguk, hire altxorrik barneenak erakutsi, denok aberastu gaituk, batez ere hireganatu. Eutsi goiari, Ibon.

Jon Etxabe

*Ametsen txokoan bizi naiz* eta *Ainarak herrira itzuliko dira* liburuen ildoari eta orden kronologikoari jarraitzen die liburu honetako bertsoek.

142 bertso eta olerki berri. Hasierakoak Puerto I-ean idatziak. Gainerakoak, Kordoban. 2014ko martxoaren 21ean eraman zuten Ibon Muñoa bertara, eta 2015eko maiatzaren 31n idatzitako bertsoarekin amaitzen da liburua.

Ametsen txokoan bizi naiz

**[1 - 162]**

Ataramiñe, 2011




Ainarak herrira itzuliko dira

**[163 - 308]**

Ataramiñe, 2014






Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin

**[309 - 450]**

Ataramiñe, 2016



## 309
## 1979-2013: Kukutzekuako Mikel etorri da

1
Lehortean izan zara
haitzetako elorri,
duin egin diozu aurre
patu neketsu horri,
gaur sorlekuan diogu
"Mikel ongi-etorri!",
zure bihotza delako
zuri, berde ta gorri.

2
Gatazka krudela sutan
ari zenez goritzen,
zanpatuen alde zinen
zintzo hasi mugitzen,
amnistiaren alorra
ez denez ongarritzen,
Euskal Herrian gabiltza
oraindino sufritzen.

3
Kukutzekua zenuen
halabeharrez laga,
soldadutzatik joan zinen
iheska sigi-saga,
iheslari eta espe
sustraiak zure haga,
aurrean duzu pozarren
aspaldiko Untzaga.

4
Pintore bihurtu zinen
kartzelaren barnean,
Peio* zenaren dohainaz
trebatu zinenean,
zure pinturak ikusgai
eskegi direnean,
zinez miretsi ditugu
Topaleku minean.

5
Arratetik urrun dira
entzun zure taupadak,
bizitzak eman dizkizu
sarritan adarkadak,
orain dituzu ordea
bero jaso aupadak,
katerik gabe laztanak,
maiteen besarkadak.

6
Ottabi ta Mairu daude
erabat hunkituta,
Eibarren ez gaudelako
zurekin ahaztuta,
urte asko duzun arren
eman giltzapetuta,
gure baitan egon zara
goxo aterpetuta.

7
Zigorra gainditu duzu
utikan mendekua,
gure artean amultsu
dago zure lekua,
zirraraz diogu ozen
"gora Kurutzekua!",
zuretzat da txapel beltza,
herkideen eskua.

8
Maitez diogu plazatik
"Mikel zatoz gurekin",
gatazka zuzen nahi dugu
konpondu elkarrekin,
apustu bat egin duzu
etorkizunarekin,
baietz etorri bakea
hegazka enarekin.

2013ko irailaren 8an

*Pello Mariñelarena Imatz
(Etxarri Aranatz, 1963.11.19 - Paris, 1993.05.15)

## 310
## Otserritik aberrira joango gara

1
Beharrez gaudelako atzerrian,
manua den kartzelen jaurerrian,
metatu zaigu nekea gerrian,
ahazteko zigorra otserrian
ametsetan gaude lasai herrian.

2
Esnatuko gara udaberrian,
ederra datorren garai berrian,
liliekin batera  sorterrian
ereinduta dagoen luberrian,
denona izango den aberrian.

2013ko irailaren 15ean

## 311
## Kontsumi dezagun elkartasuna

1
Hamabi kotxe ditu iruzurti ustelak,
beste horrenbeste futbolari hitz-motelak,
edota abeslari entzutetsu ergelak,
hori amesten du kontsumitzaile tentelak.
Amesgaitzen menpe daude zordunen logelak,
horra darama gutiziaren erregelak,
handiguraz blai daude bankarien langelak
emendatuz maltzurki behartsuen tropelak.



2
Izango garelako haritzaren orbelak
beharko genituzke zabaldu errezelak,
ikusteko aurreko miseria itzelak,
izan ez gaitezen jendartean hain epelak.
Hustuko ditugu kapitalaren sakelak
lantzeko behingoz klaseen arteko mazelak,
elkartasunak lehor ditzan begi umelak,
utz gaitzan bakean berekoikeri krudelak.

2013ko irailaren 13an

## 312
## Kartzelatik bi aldiz diot

1
Hemengoa ez naizelako diot,
ezin dudala txokoa gozatu,
ezta ere euskaldun gisa bizi,
ele maitea ganoraz usatu.
Zuekin lokabe bizi nahi nuke
nortasuna osoki suspertzeko,
auzolanean sinisten dudanez
burujabetza zuzen jasotzeko.
Jendarte hau ondu nahi dudalako
ez nintzateke joango atzerrira,
lagata maite ditudan mendiak,
Kantauri itsasotik urrutira.

2

Aturri eta Ebro artean diot,
dagoela arbasoen etxea,
hainbat belaunalditan landu zuten
euskaltasunarena den eltzea.
Mugarik ez dugunez ezarriko,
elkartasuna dugu sendotuko,
koloretsuak diren kulturekin
harreman duin bat bihotzez sortuko.
Ama-Lurra guztiona delako
Euskal Herrian dugu on zainduko,
behar duen herriari diogu
onura musu-truk zipriztinduko.

2013ko irailaren 15ean

## 313
## Aske Gunean batuko zarete

1
Etxea laga duzu
kartzelan sartzeko,
epai bidegabea
urrun pairatzeko,
haur bat zurekin dago
pena leuntzeko,
aitxarekin bestea
mina gozatzeko,
sufrituko duzue
berriro batzeko.

2
Estatu txarrak zaitu
zanpatu zeharo,
senarrak muga ezin
duenez igaro,
bananduta zarete
biziko luzaro,
bihotzak dezan gorde
esperantza naro,
maitasunean duzu
izango abaro.

3
Juezak mendekua ta
herra sustatuta,
sendia geratu da
tamal zatituta,
senarraren laztanak
irudikatuta,
alabarekin zaude
ziegan hunkituta,
hartzeko semea zain
dena prestatuta.



4
Aske Gunetik duzu
eraman aparra,
arimak senti dezan
herriko indarra,
sarri duzu ordea
egingo negarra,
alaba izango da
sehaskan zuztarra,
seme koskorra berriz
senarraren karra.

5
Kartzelan zaude bortxak
behar duelako,
lubakien zelaian
on dabilelako,
lasai egon zaitezke
gertu gaudelako,
herri harresi duina
zut dagoelako,
goiztiria oskarbi
jaikiko delako.

6
Urteak igarota
dar-dar oinazean,
xextra utziko dugu
huts ezerezean.
Donostian zaudete
txor-txor jolasean,
Aske Gunean laurak
lokabe goizean,
zuen irria dabil
kantari haizean.

2013ko irailaren 22an

## 314
## Gatibu baten oldozpenak

Beharbada gaur egun garden baino lausotuta
agertuko naiz zure oroimenean,
ahaztuta edukiko duzu nire ahotsa
hitzekin pozten nizun sentimenean,
zoritsu konpartitu genituen bizipenak
hutsalak izango dira orainean.
Oldozpen erdiragarriekin nabilelako
iretargirik gabe ohe barnean,
zirtzilduta dudan arima etengabe dabil
erreguka kartzela lar ilunean,
ekaitzak ekar dezala, otoi, kendu zuena,
ostadarra noizbait zertuko denean.

2013ko irailaren 29an

# 315
## Gatibu baten esperantza

1
Espetxeak ez du espiriturik,
ezta egileak sentimendurik,
gatibuak dio bihozmindurik,
hormatzarren barruan hesiturik,
orainean mingots katigaturik.

2
Nahiz lartxo zaio marguldu oroitza,
esperantza da gaztetako ditxa,
garunean dabil aske irritsa,
berreskuratu gura luke hitza,
iraganak ostu zion bizitza.

2013ko irailaren 29an

## 316
## Gebara eta Allende akorduan

1
Hunki nazala herriko negarrak
hunki nazan berdin Munduarenak,
gaitzetsi nahi nituzke gabeziak,
zapalketak eta gerlen zauriak.
Senti ditzadala injustiziak
neuri egingo  balitzaizkit beste,
salatzeko Ernesto Gebarak lez
nonahi hausten diren eskubideak.



2
Konponduta lurraldeko premiak
konponduko ditugu besteenak,
gure eskarmentua jator dugu
konpartituko Euskal Herritik at.
Salvador Allendek nahi zuen eran
ezabatuko dugu pobrezia,
elkartasuna ur gardena denez,
aseko ditu Munduan beharrak.

2013ko irailaren 29an

## 317
## Beatriz goiari eutsi diozu

1
Beatriz oasi bat
nahi dizut eskaini,
atseden har dezazun
bidean ipini,
zure sufrimendua
behingoz dadin fini,
bihur zaitezen uros
ametsetan nini.

2
El Salvadorren pobre
jaio zinelako,
matxistentzat ei zara
ahuntzen halako,
zuzentza barik zaude
jaunena delako,
neskatxak hor nahitaez
hauts zaretelako.

3
“Denona da”, diote
onuren ortua,
emeentzat ordea
dena da estua,
zure jabea ohi da
ar ernegatua,
berarekin zu zara
mendeko mutua.

4
Umetan jakin barik
zer zen matxismoa,
zoritsu bizitzea
zen zure asmoa,
handik gutxira izan
zenuen susmoa,
aitxa zenez etxean
agintzen irmoa.

5
Haurdun zara zorigaitz
berriro geratu,
“hil zaitezke” dizute
zentzuz gogoratu,
fetuak ez duenez
burmuina garatu,
abortatzea duzu
zuzen aukeratu.

6
Abortatu beharraz
direnez ohartu,
jende askok du zure
alde parte-hartu,
gaua zaizu horrela
pixka bat izartu,
hipokritak tamalez
zaizkizu oldartu.

7
Zure nahia dizute
zorrotz debekatu,
jueza eta eliza
dira endrokatu,
fetuaren alde du
eskuinak jokatu,
zure bihotza dute
maltzur zatikatu.

8
Hondartzan goizik duzu
begirada hitsa,
aztertzen ari zara
egoera gaitza,
opari diezazula
itsasoak bitsa,
berdintasun moreak
nahi dugun bizitza.

2013ko urriaren 6an

## 318
## Judhit eta Pabloren maitasun ederra

1
Judhit zure xarma dugu sustraitu zelaian
izan dadin haritz askapenaren garaian,
ondokoak bil daitezen hostoen azpian,
geriza diezazkien amets askeak jaian,
ospatzeko zurekin biharko loraldian
Pabloren itzulera maiteñoen gurdian.

2
Judhit, ez zenuen jaso Pabloren laztana
bidegabea delako kartzelen izana,
baina ziplo deuseztatu zitzaien afana,
mendekuak ezarritako hesi andana,
bilobek eman zizuten ezti musu bana
mikatza zena bilakatuz gozo arana.

3
Nahiz juezak handitu zuen zure mintasuna,
bihotzean duzu laztandu Judhit kutuna,
Pablo, eskertu nahi dizugu gizatasuna,
baserrian hedatu zenuen duintasuna,
iritsiko da hormak gainditzeko eguna,
argia piztuta uzteko herra iluna.

4
Zu Pablo, terrorista zara Ertzaintzarentzat,
arriskutsua Espainiako borboientzat,
bortxa maltzurki hauspotzen ari direnentzat,

Judhitekin lan egin duzu herriarentzat
utopia hurbildu nahian josten haurrentzat,
izan zarete eredu bat euskaldunentzat.

5
Txantxangorria mezulari dator Laudio,
goiz-argiaren zohardia dela medio
Itxinan kantu hau garbi entzun dela dio:
“Gurean dago kartsuki hainbat amodio,
sakon euskarri on den hainbeste usadio,
Pablo ta Judhit zurtoin bereko goroldio”.

2013ko urriaren 13an

## 319
## Herrira, herria da

1
Leihoan nago minduta
lainoei begira,
askatasunaren printzak
estaltzen ari dira,
sentieran zurekiko
borborka dabil mira,
ziegatik zirraraz diot
“Maite zaitut Herrira”.

2
Txapelokerrek gaur dute
Herrira estu lotu,
Barne ministroak kar du
erasoa txalotu,
ertzainak batu zaizkie,
jotzen dira harrotu,
argiro dago direla
Espainian errotu.

3
Hortzemuga hur ei dago
zeru garbiarekin,
dena erraza dirudi
gure Herrirarekin,
ekaitza lehertu denez
haizete zakarrekin,
klar erakutsiko dugu
garena elkarrekin.

4
Amesgaitzak ziplo gaitu
ohean aztoratu,
egoera zaila dela
digu azaleratu,
herrak duenez Herrira
errukigaitz sastatu,
arimek bikainki dute
adorea sustatu.

5
Bolaluma da dudana
idatziz azaltzeko,
ankerrek egin dutena
zehazki salatzeko,
Herrira kolpatu dute
gatazka luzatzeko,
zuzenak diren asmoak
kartzelan galgatzeko.

6
Estatuak oldartuta
hitza nahi du isildu,
euskal presoen laguna
zigortuta kikildu,
lurra kenduta nahi luke
elkartasuna hildu,
halaber exiliatuen
esperantza zirtzildu.

7
Gatibuak itzalean
ez gara bananduko,
Herrira dugu batera
ekinez omenduko,
xantaiak tinko ditugu
gugandik baztertuko,
Aiete zintzo baitugu
zuekin garatuko.

8
Herrira behar zaitugu
ziegak hutsik uzteko,
itsasoa osatzeko,
zauriak on ixteko,
gertu daude tximeletak
hegan aske hasteko,
tanta urdinak plazetan
harrerak egiteko.

2013ko urriaren 20an

## 320
## Egiazko istorio bat: Handigura sarritan kartzelan dago

1
Urliak nahi zuelako jaun izan
fantasiak burua zertu zion,
Barcenas ei zen bere eredua,
Barcina berriz desioen musa.
Ozta mila euro irabazita
handigurak bazterrera bota du,
diruak gainezka egin dionez
Martutenen dago giltzapetuta.
Donostian bizi nahi omen zuen,
Ferrari bat eduki garajean,
txalet bat Igeldoko magalean
laketontzi bat Kontxako badian.

2

Norberekerian grinaz sartu zen,
kontsumismoan txoro barneratu,
iruzur bat baldarki egin zuen
berekoi samar portatu zelako.
Ziegan barra handiei helduta
askatasunari begira dago,
elkartasunaren altzo beroan
senti dezala behar duen xarma.
Hau istorio bat izan den arren
hormen barruan ipuin gutxi dago,
halako ehunka daude lur jota
euroa lehenetsi zutelako.

2013ko urriaren 27an

## 321
## Izarretan zaudelako

1
Neure ametsa izarretan zaude
ortzia oskarbi dagoenean,
zigor astunak ez nau lar estutzen
hain dotore agertzen zarenean,
zeuri begira gogoa joaten zait
maite genituen txokoetara,
noizbait biziko dugun pizkundera,
merezi ditugun plazeretara.

2
Zeu zarelako neuretzat lilura,
zohardia ziega hits ilunean,
etortzen zara xaloki nigana
maitekor oheratzen naizenean,
etorkizunean batuko gara
geure udaberriaren lorian,
arren, gerta dakigula Arraten
goiz-argi askearen atarian.

2013ko urriaren 27an

## 322
## Kartzelan matxismoa bor-bor

1
Kalean lez akerra
kartzelan okerra,
preso batzuek dute
jarrera ankerra,
gayei diete maiz
adierazten herra,
emakumea ez da
kantuko eperra,
baizik menpean estu
hartzeko giderra.

2
Zenbat gizon gihartsu
eta psikopata,
gorputza beste gurtzen
bortxaren ezpata,
gure artean dabil
harro automata,
ibiltzen ergelduta
modaren estrata,
irits dadila bere
iraungitze data.

3
Atleta izan nahi du
kaskamotz lakarrak,
pilulak hartzen ditu
puzteko bularrak,
ile barik ohi dauzka
fier gorputz adarrak,
bikain erakusteko
bertako giharrak,
itzal diezazkiola
zentzuak txingarrak.

4
Gimnasioan dabil
sendo indartzeko,
arte martzialetan
gogor trebatzeko,
koltxonetan dago zain
sutsu lehiatzeko,
kolpeka hoberena
dela frogatzeko,
adimena baino du
zerrautsa saltzeko.

5
Emaztea gura du
etxea zaintzeko,
prostituta gozatu
eta trufatzeko,
zakiltzarra darabil
berak pentsatzeko,
matxismoa ozenki
petral goratzeko,
kartzelan erregea
dela zaunkatzeko.

6
Arren, senda dadila
gizon oldarkorra,
gal dezala edonon
oilarrak gandorra,
feminismoak dezan
geraraz txingorra,
berdintasunak jori
ongarri alorra,
jaio dadin libreki
giza emankorra.

2013ko azaroaren 3an

## 323
## 197/2006 joan da, ongi-etorri Ines eta gainerakoak

1

Esperantza sorterrian ezbaian zegoenean
esnatu zen Zuzentza, Estrasburgo haranean,
herrari apurtu zaio asmatu zuen gailua,
ankerrentzat ziplo, dena da belztura ta dolua,
gaur udazkena zaigu iruditzen udaberria,
hurrago sumatzen dugu goiztiriaren zirria.



2

Mendekuak galdu du, zuzenbideak irabazi,
gatazkaren trumoi ozenak dira urruntzen hasi,
konponketa indartu da, indarkeria mengeldu,
eskubidea bizitu, inposaketa moteldu.
Espeak du xuxurlatu gaueko bakardadean,
"Naro goza ezazu Ines euskal xarma goizaldean".

2013ko azaroaren 10ean

## 324
## Olerki apal bat bertsolaritzarentzat

1
"Txapelketa hasi da eta ni preso",
aipatu dut sentitzerakoan pena,
nahiz arimaren xarma urrun dagoen
eskainiko diot neure aitorpena,
olerki apal bat bertsolaritzari,
azaltzeko zor diodan mirespena.
Hemen barruan entzuten dudanean
estatu bidegabeen oldarpena,
bertsogintzak dakarkit ukendu gisa
bihozñoak behar duen sustapena,
gogotik ziztu bizian aldentzen da
ideia kaltegarrien agerpena.

2

Bertso zu zara kulturaren zirrara
pentsamendu atseginen hastapena,
Munduan zehar zara duin eta xume
herri honen nahieraren aurkezpena,
euskara oparo ereiten duzunez,
errazten diozu bikain iraupena.
Asaben lur emankorra zarelako
asetzen diguzu kantuz sentipena,
gure historia lantzen duzulako
bizirik dago euskoen oroipena,
kartzela hitzekin birrintzen duzunez
ametsak dira zurekin askapena.



2013ko azaroaren 10ean

## 325
## Ilusio, kartzelan onura zara

1
Ilusio zu zara
Kartzelan hauspoa,
Pazientziak zurekin,
heze du erroa,
umo dakidan mardul
pozaren nardoa,
ibiltzeko egoki
penaren aroa,
topatzeko bidean
baikorki geroa.

2
Kartzelako aldapa
denez erraldoia,
ilusio senduna
da neure saroia,
ideien arragoa,
asmoen gidoia,
dastatu gura nuke
gaztainen sasoia,
bihotzak egotz dezan
hemengo pozoia.

3
“Ilusioa” dio
irrikaz otoiak,
baztertzeko gogotik
torturaren lohiak,
ziegan sastatzen nauen
herraren puntxoiak,
aurrerantz jarrai dezan
desiren atoiak,
halaber euskarri den
euskal arrazoiak.



4
Nire gainbehera da
ankerren afana,
madarika dezadan
petral iragana,
Ilusio etorri
amultsu nigana,
gaindi dezadan aise
etsipen txaldana,
ahaz ez nezan dela
herria imana.

5
Ilusio ekarri
dir-dir esperantza,
ken dezadan larrutik
hainbeste arantza,
kartzelaldia doa
geldiro gorantza,
gorputza fisikoki
aldiz beherantza,
zurekin dut ordea
isiltzen arrantza.

6
Ilusio zut gaude
sokari eusteko,
urruti egon arren
gertu ekiteko,
atsekabe minkorra
lerden erauzteko,
mila motibo dugu
zurekin joateko,
kate barik herrian
bizitzen hasteko.

2013ko azaroaren 17an

## 326
## Behin batean Urko mendiko koban

1
Egun oskarbi sano batean zen gertatu,
Urko mendiko koba genuen ikustatu,
ez da Santimamiñe, Isturitz edo Ekain,
merezi du ordea txango baterako lain,
Praileaitzek lez harrobi bat du bere zeran,
ondarea ez dugu zaintzen behar den eran,
ez behintzat gure arbasoek zegiten haina,
polita dena bihurtzen dugu maiz uzkina.
Harrobiko jabeari nioke esango
ditxa ez dela soilik dirutza ta fandango,
bazterrak aratz nahi ditugula bizitzeko,
Ama-Lur kantu ederrenekin ondratzeko.

2

Irrikaz joan nintzen haurtzaroko lagunekin
koba xumea topatzeko asmoarekin,
bizi abiatu ginen linternak hartuta
bertako ustezko altxorraz kitzikatuta,
Ixuatik jo genuen Urko tontorrera,
Elorreta baserrira gero galdetzera,
hurrean zegoen, pinudi baten hondoan,
bihotzak punpaka ziren hasi haitzuloan.
Nahiz ez ikusi altxorrik barrunbe motzean
herrira pozik bueltatu ginen arratsean,
bakean laga beharko genuke natura
gaurko haurrek senti dezaten pilpira hura.

2013ko azaroaren 24an

## 327
## Bangladesh entzundakoan diot zorigaitza

1
Ez zinen jaio esklabo bizitzeko,
zoriona zer den ez ezagutzeko,
haurtzaroan ezer gutxi jolasteko,
lan miserable batean zapuzteko,
hamaika ordutan astun zamatuta
etxeko behar gorriak bultzatuta,
gure arropa politak ekoizteko,
urrutiko jauntxoak aberasteko.
Gaur neskatxa joan zara ez itzultzeko,
amets ederrak negargarri galtzeko,
tailerra jausiko dela sentitzeko,
Balberen atzaparkada jasotzeko.

2

Bangladeshen eskubiderik ez dago,
kapitalak hola gura du nahiago,
janzkiak merke-zurrean ehuntzeko
hemen gero etekin handiz saltzeko.
Hondamendiak gaitu sakon hunkitu,
haiei zaizkie bihotzak txikitu,
zuzentza beharko genuke ziztatu,
hipokrisia gugandik deuseztatu,
esklabotza gupidagabe zigortu,
handiguraren iturria lehortu,
elkartasuna han ta hemen jorratu,
haur txiroaren bizitza izarratu.

2013ko azaroaren 24an

## 328
## Isidrori, Antxoni, Iñakiri... eta denori

1
Estrasburgoko bozak
inarrosi gaitu,
epaiaren haizea
dugu gaur sentitu,
gure begiak dira
zirraraz gorritu,
esperantza delako
kartzelan handitu,
gidari onbera da
umilki partitu,
“gero arte” diogu
baikorki aditu.

2
Izarrak beha daude
gaua edertzeko,
txaloka gara gogoz
hasi ospatzeko,
estuki besarkatu
dugu omentzeko,
merezi duelako
maitez agurtzeko,
kidea urrundu da
libre bizitzeko,
denon askatasuna
kemenez zertzeko.

3
Etxartea izan da
ohiko lekukoa,
pozik dugu dastatu
gertatutakoa,
hunkituta joan zaigu
bihotz herrikoa,
ehunka taupadekin
beteta kolkoa,
igaro eta gero
une magikoa,
oroitzan dakusagu
hegan kidekoa.

4
Injustizia zuen
urtetan nozitu,
elkartasunak zion
zigorra eztitu,
garai ederrean du
kartzela gainditu,
gatazka dugunean
argirantz higitu,
etxeak dio sano
arima bizitu,
Mari zaio Anboton
elurrez beztitu.

2013ko abenduaren 1ean

## 329
## Berriro batuko garelako

Zigorrari kemenez irabazita,
gaur ziega hustu duzu txukun utzita,
bihotza irrikaz eskatzen ari da
“besarkadak izan dezala segida”,
batuko gara, zeu, neu eta besteak,
kide apalak askatuta kateak,
bizipen onak ditugu aipatuko,
atseginaren lurrinak arnastuko,
arbasoen lurralde miragarrian
zirrara sakon dilindan eztarrian,
herria loretsu egongo delako,
irribarretsu biziko garelako.

2013ko abenduaren 1ean

## 330
## Diktaduraren garaian (1958) jaio nintzen

1
Telebistak moztu zizkidan asaben hegoak,
artean erdaraz mintzatzen ziren pailazoak,
eskoletan ez zen gure kultura irakasten,
mukizuek ez genekien euskaraz jolasten,
neure gogoa ez nuen ikastolan pausatu
ikasketak ezin zirelako bertan osatu,
Francok arima laua zakarki zidan zimurtu,
haur euskaldun bat izateko grazia lapurtu.

2
Gaurko haur xarmantak pozarren ditut begiratzen,
euren berbetek sentiera didate sustatzen,
berriro jaio nahi nuke euskaraz bizitzeko,
pailazoekin aisia ederki pasatzeko,
Olentzeroren etorrerarekin hunkitzeko,
andereñoarekin zoragarri kantatzeko,
ipuinak  irakurrita zoritsu amesteko,
izan nahi nuen txori alegera izateko.

2013ko abenduaren 8an

**331**
**Eskaileretan utopiaren bidean**

1
“Zenbat estai nahi dituzu igo?”,
galdetu zidan Etorkizunak.
“Bost bertan dago lo Utopia”,
erantzun nion erabat ausart.
“Ez duzu hobe igo bat soilik?
Lasaiki zara hola biziko”,
aipatu zuen gero atetik,
“Bizitza nahi dut aprobetxatu
Amnistiari laño eskaini”,
esanda egin nuen aurrera.

2
Eskaileretan nabil ordutik
nekeak eta porrotak bilduz,
nahiz garaipenak urriak diren
animoa dut zutik goizero,
orain garbiro dakidalako
hurrengo euskal belaunaldiak,
plazan izango duela gorri,
berde ta zuri den askamena,
neure izena Esperantza da,
lur eder honek behar duena.

2013ko abenduaren 8an

## 332
## Gosaria txolarreekin konpartitu duzue

1
Txolarrea gose dago
indarge arratsean,
txioka “Zuzentza!”, dio
Morongo espetxean,
urdaila huts-hutsik dauka,
gogoa baratzean,
hegoak lotuta dauzka,
estu kate motzean.



2
Gatibua larri dabil
herraren etxartean,
egun motzetan hotza da,
laiotza goiz partean,
miaketen maiztasunaz
ase azken urtean,
erabaki du baraua
hastea tupustean.

3
Gatibua txortxorrekin
esnatzen da poztuta,
txoria leihoan dago,
aiduru pausatuta,
elikatu gura luke
ogia zatituta,
tamalez orain ezin du
barauaz gabetuta.

4
Biak daude izoztuta
zeharo uzkurtuta,
eguzkia gurtzeko zain
begiak tristatuta,
izpiak iritsi dira
porlana gaindituta,
beroak laga ditzala
arau gaitzak urtuta.

5
Ankerrak eta belatzak
diete erasotzen,
gal dezaten bizipoza
maltzur adarra jotzen,
nahiz zuzen saiatu diren
arazoak ehotzen,
bihozgabeak dabiltza
mendekua errotzen.



6
Zuzendari ahaltsua
agintzen da gotorra,
kideen bizimodua
bihurtu du minkorra,
eskubideen arloan
bera baita sorgorra,
burdinazko ukabilak
ez ditzala izorra.

7
Gatibuek baitan dute
hamaika gutizia,
konponketa sustraituta
loratu justizia,
bistatik betiko galdu
hemengo malezia,
Euskal Herrira itzuli
ahaztu gabezia.

8
Txolarreak inoiz baino
hobeto du kantatu,
gatibu bortxatuei
xarma die txertatu,
herriari lekukoa
eman dute hautatu,
duintasuna ez diete
arimatik kitatu.

2013ko abenduaren 15ean

## 333
## Bizipozarekin askatasuna datorrelako

1
Bizipoza ezkutatzen denean
animoa zaizu zapuzten,
ilusioak zaizkizu lausotzen
desirak erabat murrizten,
orduan ezinean hasten zara
ideia ezkorrak egosten,

saldatxo eskas horrekin dituzu
helburu bikainak nahasten,
hobe zenuke hasiko bazina
euskal arima baikor josten,
marmar egin beharrean ergelki
jardun herrigintza marrazten,
“Herri honengan konfiantza daukat”,
has zaitez jatorki esaten,
gaua igaroko duzu amesten,
eguna bizitza idazten.

2

Bihotza sentitzeko euskal kantak
goizero dituzu abesten,
hitzekin eta doinuekin zaizu
bizipoza zoragarri pizten,
jarrera horrekin jaikitzen zara
ardurei adorez eusten,
askatasuna loratzen delako
askatzeko nahia berresten,
utopiak ehuntzen direlako
ezina ekinez egiten,
aberriko larrainak duelako
goldatuta naro ematen,
gauaren ostean ekialdetik
egunsentia den lez hasten,
gure udaberriaz hasi  dira
banan-banan leotzak husten.

2013ko abenduaren 22an

**334**
**HEGAZTIAK HAMAR**
**Mozolo bat ez den mozoloa**

1
Gauerdiko mozoloa
ez da tontolapiko bat,
hegazti harraparia
mentsa baino argia da,
lumaje nabarra dauka,
moko kakodun sendo bat,
atzapar zorrotzak dauzka,
begi zoli borobilak,
ehizan dabil gauero
ixilik eta trebeki,
kabian dauden kumeak
arduraz elikatzeko.

2

Gautxoria beha dago
buru ederra higituz,
izadian dabil aise
senak zuzen gidatuta,
lo dagi ekiarekin
aterpe seguruetan,
ilargiarekin aldiz
zoragarri hegatzen da,
gauminean hor dihardu
gure ametsak sustatzen,
oihuka hasten denean
arimak ditu xarmatzen.

2013ko abenduaren 22an

## 335
## Iratin azken oporretan

1

Iratik berdexka dauka
udan arbolen grazia,
udazkenean urrez du
beztitzeko artezia,
neguan soil da geratzen,
hosto barik biluzia,
udaberrian berpizten
zaio kolore bizia,
pagadi trinkoa ei da
basoilarren gutizia,
aroan entzungo duzu
kantuaren delizia,
Ama-Lurrak jaso zuen
oihan polit berezia,
izakiak goza dezan
bertako dotorezia.

2
Zurekin poz sartu nintzen
Iratiko barrenean,
bi milagarren urtean
oporren abagunean,
udako lurrin anitzak
generamatzan soinean,
zoritsu geunden batera
naturaren oihanean,
“Lagun” usainka zebilen
lokabe aldamenean,
belarrak grinaz dastatuz
eroso bere gunean,
Irabian ertz batean
lasai etzan ginenean,
eguzkia eseri zen
ur berdearen gainean.

3

Irabia hezetsua
oihanaren maitalea,
Irati berde galanta
uharkaren mireslea,
bikote bikaina baita
izakien babeslea,
asaben deiturek dute
omentzen euskal elea,
egon eta gero zara
bihurtzen sano zalea,
paradisua delako
desioen arazlea,
edonork nahi luke izan
txoko horren biztanlea,
arratsero hunkituta
izarren behatzailea.

4
Irati gurtu genuen
luzaro ikuskatuta,
kolore berdeaz geunden
zoragarri xarmatuta,
“Lagun” gu lez aurkitzen zen
bizipenaz txoratuta,
oihanean ibilita
sena zuen suspertuta,
oporrak bukatu ziren
betikora bueltatuta,
gatazkak zigun ordea
gogoa laga histuta,
neure nahia da zeurekin
egon han maitez urtuta,
ager dadin gure poza
Irabian islatuta.

2013ko abenduaren 29an

## 336
## Arima giltzapean, gogoa alderrai

Arima giltzapean ilunki geratu zait,
indarge deserri mugatu honetan,
gogoa dabil alderrai geure zeruetan,
urrun dauden haran eta mendietan,
egarrituta nago basamortu larrian
izadia xurgatu barik urtetan,
maiz diot “eutsi!” freskuraren zain izerditan

uda sargoritsuen arrastietan,
izarrak agurtzen ditudanean hasten naiz
argiari deika egunsentietan,
herrira joateko bidea topatu nahian
lehendabiziko eguzki printzetan,
ez ahazteko gure xedea dagoela
amesten ditugun askatasunetan,
egarria ganoraz asetuko dugula
maite ditugun laminen erreketan.

2014ko urtarrilaren 5ean

## 337
## Saguzarren terapia

1
Saguzarrak dabiltza iluntzean
eltxo petralak abil ehizatzen,
mintzezko hegotxoak astinduta
nekaezinak dira hegatzen,
udan etxartean dute gauero
ikuskizuna dohain moldatzen,
birak eginez ari direnean
kemena zaizu ziplo goratzen,
momentu on hauei esker ditut
ezbai eskasak erraz haizatzen,
zeintzuk diren gure asmo zuzenak
ditudalako nik gogoratzen.

2

Ilargiarekin hobeto ditut
lagun txikien birak preziatzen,
tamalez giltzatuta naukate
barren atzetik nago behatzen,
saguzarrak gautarrak direlako
eguna lotan dute pasatzen,
ni aldiz goiztirian esnatzen naiz
gatazka ondu nahian pentsatzen,
gauerdiko terapia honekin
esperantza ez zait amatatzen,
izaki duin hauen aurrean diot
ari garela sano askatzen.

2014 urtarrilaren 5ean

## 338
## Eloy Velascok ez duen nahi arren, itsasoa eratu dugu

1
“Ttantta” lainoan dago
garden ametsetan,
hezetsu bizi nahi du
gure bihotzetan,
Bilbon jausi nahi luke
tanten ilaretan,
urdin, urtarrilaren
hamaikan seiretan.

2
“Ttanttak” dio, “Ez dut nahi
soraio lurrundu,
besoak antxumatuz
inozo zurrundu”,
beste tantekin nahi du
nagia urrundu,
amnistia urdina
herrian errundu.

3
Arimak hasi dira
tantaka elkartzen,
ibaiak osatuta
itsasoan sartzen,
Bilbok baikor dakusa
zerua izartzen,
kolore urdinaren
magia indartzen.



4
Zenbat tanta batera
Bilbo zeharkatzen!
Zenbat preso zirraraz
ziegan kulunkatzen!
Estatuek dutenez
argia ukatzen,
herri urdina dabil
sasitza pikatzen.

5
Itsasgainean daude
aparrez uhinak,
ozen entzun daitezen
euskoen saminak,
“eskubideak” dio
Ttanttatxo urdinak,
“behar ditu presoak
eta ez irainak!”.

6
Hainbeste tantarekin
Bilbo da urdindu,
askatasunez dira
txokoak lurrindu,
presoen gomuta da
bikainki astindu,
etxekoen nekea
ederki arindu.

7
Tanta urdinek dute
porlana zulatu,
mendekua birrindu,
herra kanporatu,
Bilboko atsegina
bizkor da hedatu,
zipriztinduta dira
presoak esnatu.

8

Adoreak blai ditu
laga kontzientziak,
juezaren debekuak
gehitu iritziak,
itsas urdinxkan daude
kutunen ontziak,
amaitu direlako,
fini erauntsiak.

2014ko urtarrilaren 12an

**339**
**Bi mila ta hamalau zurekin gerta dadila**

1
Hamahiruk Estrasburgon hesia ireki zuen lez,
zuk kinka ontzeko giltza ei daukazu,
geroa zehatz iragarri zaila omen den arren
zure berbari egingo diot kasu,
aitortu duzuna gertatuko dela bermatzeko
mahaitxo honetan sina iezadazu,
Bi Mila Ta Hamalau, atea zeharkatu duzu,
ziega itxaropenez bete didazu.

2
Atzo leihoko beirak lar lausotuta nekuskien,
gaur garden dakuskit, distira zara zu,
espe gaudenok nahi ditugun hobekuntzen zerrenda
egutegian zintzilik daramazu,
otoi, gu herriratzeko haizea leun ekarri,
mortuetara zuzen gida ezazu,
Euskal Herrian sufritzen ari diren bihozñoak,
ekintza on horrekin senda itzazu.

2014ko urtarrilaren 19an

## 340
## Bilbon gaude irudimena dugulako hartu

1
Gaur Bilbora goaz irudimena hartuta
sentitzeko freskura itsasoan sartuta,
gogoaren grina gera dadin konplituta,
gutunez non batu, dugu elkar adituta.
Joango gara zirraren zoruan ibiltzeko,
maiteñoen kantuak gertutik preziatzeko,
taupaka elkartasuna bero eskertzeko,
sagailoaz espetxeak hutsik lagatzeko.



2
Bilbo erdian dabiltza tantaka garatzen,
amnistiaren itsasoa eder eratzen,
herritarrak arduratsu ari dira batzen,
giza eskubideak adoretsu eskatzen.
Gu hor gaude pozarren partaide izateko,
arimek nahi duten konponketa babesteko,
xede on bat dute garbiro erdiesteko,
geu ekarri, aberria jori ereiteko.

2014ko urtarrilaren 19an

## 341
## Akelarrea, ministroa eta gatibu ohien aldarria

1
Durangon izan dute parada
berri on bat emateko,
gatibu luze egon direnak
gure alde jarduteko,
prentsaurrekoan elkartu dira
agiria babesteko,
Kolektiboak esan duena
batasunez berresteko.

2
Mendekua nahi duten ankerrek,
zakar zaizkigu oldartu,
guk dioguna zuzena dela
ez dute gura onartu,
aurkeztu dugun proposamena
nahi dutelako ihartu,
konponketaren lurra kakaztuz
lubakian dira sartu.

3
Barne ministro espainiarrak
bota dizkigu harriak,
espe gaudenak sentitzen gara
horren menpe zaurgarriak,
herriak garbi nahi duena da
moztu azkar lokarriak,
hitzaren bidez eror daitezen
gaurko kartzela larriak.



4
Ministroaren jarduera da
oro arbuiagarria,
akelarrea dela esan du
bakearen aldarria,
Euskal Herrian dugu gatazka
zarratzeko egarria,
bihur dakigun bortxarik gabe
bizitza zoragarria.

5
Jorge omen da bere grazia,
eitea kasernakoa,
inkisidore haiek bezala
sorgin ehizen kastakoa,
sua isiotzen dabilelako
gizon ganorabakoa,
ziegan gabiltza gordin sufritzen
pizkundearen ukoa.

6
Akelarrea zen emazteek
gauez zegiten bilera,
sendabelarren jakinduria
mantentzeko zuten era,
bestalde esan nahi du bordela,
ulermenaren galera,
eztabaidetan faxistek duten
eguneroko jarrera.

7
Urratsak eman ditugun arren
zezena haserre dago,
horren orroa da “gu hobeto
gero eta makurrago!”.
Bere aitxak lez Francoren txortan
samina nahi du gehiago,
galtzaileen ta irabazleen
zorua erein nahiago.



8
Euskoak ari gara zintzoki
etorkizuna prestatzen,
atzoko minak zentzuz gabiltza
pixkanaka oneratzen,
nahiz Alba, “Zera” eta Urquijo
dabiltzan dena zanpatzen,
espeok josi dugun mezua,
bihotzek dute bermatzen.

2014ko urtarrilaren 26an

## 342
## Iruñeko auzapezaren semeari

1
Bart erakutsi duzu arrazista zarela,
ideologiaz total  eskuindarra,
nahiz hiriko auzapezaren semea zaren
zure portaera izan da kaskarra,
udaltzainek zaituzte gauean harrapatu
horma bat baldar bustitzen zarra-zarra,
hitz egin duzunez gizatasun faltarekin
nafarra baino zu zara txerri arra.

2
elkartasuna denez auzolanaren muina,
lurraldea gidatzen duen izarra,
etorkinekin izan zaitez eskuzabala,
eta ez orain lez koldarki takarra,
ez dizutenez irakatsi jakin ezazu
Nafarroa dela euskoen zuztarra,
Aturri ta Ebro artean dela jaioko
zertzen ari den herri berri nabarra.

2014ko otsailaren 2an

## 343
## Velasco bele beltza

1
Eskuinaren kolorea kasernarena da,
belea bezain beltza juezaren arima,
Eloy Velasco karranka dabil bulegotik,
herrarekin dagi egunero errima,
horren epaiek zabartzen dute justizia,
galarazten adierazpen askatasuna,
presoen bitartekariak espetxeratuz
konponketari dio gaizkitu jarduna.



2
Tantaz-Tantari dio itsasoa ukatu,
elkartasuna nahi du hola ezkutatu,
euskal eragileen ausardiak ordea
anker horren asmoak ditu deuseztatu,
nahiz juezak nahi duen esperantza izorratu
bihozgabe geroa kartzelan kokatzen,
herria batasunez delako abiatu
Bilbo zaharra dabil libre zeharkatzen.

2014ko otsailaren 2an

## 344
## Demokritok esan zuen atomoak garela

1
Filosofia ohi da
kezken baltsamoa,
bizitza hobetzeko
arimen salmoa,
Demokrito izan zen
ikertzen irmoa,
materia zehaztu
beraren asmoa,
horrela definitu
zuen atomoa.

2
Demokritok zioen
natura miatzen,
“atomoak ei ditu
itxurak garatzen,
hautematen duguna
baitu isladatzen”.
Sentimendua ez du
ordea osatzen,
gizakiaren herra
ez deus bilakatzen.

3
Agoran ez zituzten
bihotzak  hunkitu,
greziarrek ez zuten
bakea mamitu,
gudak gaurdaino ditu
zelaiak gorritu,
lur honetan ditugu
soberan sufritu,
ahalko dugu noizbait
zentzua ongitu?

4
Euskal Herrian dugu
maiz filosofatzen,
egoera hobe bat
gogoz desiratzen,
Demokrito lez gaude
bidea urratzen,
gatazka zuzen nola
konpondu mintzatzen,
behar diren pausuak
zehatz kalkulatzen.

5
Jakintsu batzuk dira
ederki aritu,
egoki direlako
herrian sustraitu,
ideia oparoak
ditugu aditu,
esperantzaz zaizkigu
gogoak hornitu,
kontzientzia nagiak
ganoraz bizitu.



6
Filosofa dezagun
dena iraultzeko,
kapitalismoari
langa ezartzeko,
Estatu egoisten
bortxa gelditzeko,
elkartasuna nonahi
sendo finkatzeko,
atomoak garenez
Lurra salbatzeko.

2014ko otsailaren 9an

## 345
## HEGAZTIAK HAMAIKA
### Itoitzeko altxorra galdu zutenei

1
Itoitzen kanpatuta nuen aditu
jarraian idatziko dudan ipuina:
Ugatz emeari laket zitzaizkion
Urrobi eta Iratiko arroak,
ugaltzeko egokiak omen ziren
orduko inguru horien bazterrak.
Tamalez, hustutzen ikusi zituen
ibaietatik hurbil zeuden herrixkak,
denbora horretan kezkatzen hasi zen
Itoitzen hazten zekusan hormarekin,
halaber errepide berriarekin,
hango baso zaharren galerarekin.

2

Leherketekin zen goian aztoratzen,
harrobiaren harrabotsaz izutzen,
“iruzurtien garaian bakerik ez”
hausnartu zuen ilunabar batean,
“urtegiarekin etorkizunik ez”
malkorrak urpetzen hasi zirenean.
Ugatzak begi grisak bildu zituen
azken gaua pasatzeko harkaitzean,
“maite zintudan!” esan zuen oihuka
leku aratz baten bila joan aurretik,
ez ahazteko galdutako altxorra,
oroitzeko egunero sorlekua.



2014ko otsailaren 16an

## 346
## HEGAZTIAK HAMABI
## Orhiko saia laket bizi dadin

1

Saia laket dago Orhin aireratzen,
eroso goitik inguruak behatzen,
hilotzekin da mendian elikatzen,
lurreratuta zabuka hurreratzen,
sarraskiak ditu goseti xehatzen,
naturan dihardu ardura gauzatzen,
moko kakoduna du trebe usatzen,
ekologiaren oreka obratzen,
izaerak dio gorputza gidatzen,
bizitza bapo doa hola osatzen.

2

Aurreiritziek gaituzte asaldatzen,
itxurak baina ez du sena islatzen,
onetsi baino ditugu gorrotatzen,
bankariekin erkatuz laidoztatzen,
artzainek ordea zituzten ondratzen,
begirunez belardietan tratatzen,
Ama-Lur zutelako maitez preziatzen
txirulaz zieten bihotza opatzen,
Orhiko gaina ez dut irudikatzen
saiak ikusi gabe udan hegatzen.

2014ko otsailaren 16an

**347**
**Arkaitz zurekin bizi gara**

1
Saminak uzkurtu gaitu
otsailaren bostean
arratsaldeko bostetan
jo du gure atean,
ametsetan zaude ziegan
zeure nahien urtean,
Elorrio da maitea
ilundu bat batean.

2
Nahiz hemen edo geurean
tamala den kartzela,
zigorraren estresa da
deserrian krudela,
sasoia gelditzen zaizu
pixkanaka motela,
larrutik ordaintzen dugu
herraren erregela.

3
Heriotza kartzelara
gazte datorrenean,
sentimena negarrez da
sartzen etsipenean,
kideak gaude lur jota
zurtz zure hutsunean,
elkar ikusiko dugu
zirraren egunean.



4
Maiatzean zain zeneukan
zoritsu askapena,
laztanaz bizitza libre
baten iragarpena,
gauminean handitu da
etxean minki pena,
oroitzak ekar dezala
arimen sustapena.

5
Kartzelaldia zuretzat
ez da izan erraza,
sarri jasan duzulako
ankerren tratu basa,
mendekuaren aurrean
zu zinen duin demasa,
gorrotoari zenion
kendu sano arnasa.

6
Aizu, eskertzen dizugu
oro aldarte ona,
gogoetan ez da sorgor
galduko zure sona,
etxartean izan zara
guretzat zoriona,
kartzela goibela duen
alaitu klariona.

7
Monzonek esan zuen lez
ortzian zara zertu,
Ageda zenaren gaua
dir-dir duzu edertu,
taupadetan zaudelako
gure barnean gertu,
zure zirriek digute
adorea suspertu.



8
Anboton ta Udalaitzen
zu zaude harkaitzetan,
txapela txukun jantzita
nare goiz-argietan,
Euskal Herrian geroa
ez dago zalantzetan,
gurekin biziko duzu
pizkundea plazetan.

2014ko otsailaren 23an

## 348
## Eibar ez delako Villanueva de San Andres

1
Goizean Urkora igo garenean
ohartu ez zaren arren mindu nauzu,
hatzarekin Egoarbitza seinalatuz
"Hori La Peña da" esan duzulako,
ez zaitez izan hain axolagabea,
asaben toponimia zain ezazu,
Eibarren ditugun lekuen izenak,
euskaraz mendetan direnak aipatu.
Guk Ibarkurutzeko iturriari
zergatik deitzen diogu "cuatro caños"?
edota Erreinaren etxeari
"Casa de la Reina" txarto itzulita?

2

Hemen kultura dugu ergel pobretzen,
hizkuntzaren enborra baldar ihartzen,
ezin dugu jarraitu izen jatorrak
erdarazkoekin sorgor ordezkatuz,
errege arrotzak hola egin zuen
duela zazpi mende sentimen barik,
bailara hau zuenean gazteleraz
“Villanueva de San Andres” bataiatu.
Akulturazioari garaitzeko
babes ditzagun Eibarko sustraiak,
hurrengo belaunaldiek naturalki
Arrateri dei diezaioten Arrate.

2014ko martxoaren 2an

## 349
## Zurrumurru maitagarri bat

1

Neure sentimendua nabarmen da hobetu
gogoratu dudalako non dagoen poza,
zurrumurru bat entzun dut goizean ohean
hostoek haizeaz dagiten antzerakoa,
“atzo eta gaur lez, bihar maiteen maitale”,
egunari bikain eman diot hasiera.
Atzo, jaio nintzenetik maitatu ninduten,
heziketa horrekin maitatzen hazi nintzen,
gertu nengoen hurkoak zintzo maitatzeko,
bizitza maitasunean xalo ibiltzeko,
zoritxarrez gorrotoa ezagutu nuen,
maitasuna jipoitzen duen injustizia.

2

Gaur, kartzelan nago maitasunaren beharrean,
Euskal Herriarekin du arimak gozatzen,
elkartasun abegikorrak eta kideek
elikatzen naute atseginez eta maitez.
Bihar, ziurrenez kartzelan jarraituko dut
guda-zale zitalen mendean gaudelako,
horrela gertatuko da maitasun lerdenak
inposaketari zuzen irabazi arte.
Zurrumurrua gogoan isildu denean
maite dudan laztanarekin akordatu naiz,
askatasuna delako mardul loratuko,
bihotzaren lurrina diot oparituko.

2014ko martxoaren 2an

## 350
## Albokaren notak sartu dira neure gogoan

1
Alboka baten notak entzunda
edertzen dira begiak,
isiotzen ziplo goiko ganbaran
itzali diren argiak,
tresnak sustatzen ditu gatazka
zuzen zertzeko ideiak,
aise haizatzen euskal zerutik
ekaitz gaitzaren hodeiak.

2
Alboka ei da zelai lehorra
loratzen duen hauspoa,
egunsentian zutik jartzeko
laguntzen digun orpoa,
egun garbia bihur ez dadin
putzu beltz baten hondoa,
erein dezagun aire alaiaz
maitasunaren ildoa.

3
Xextrak sakonki ditu tamalez
zauritu gure bizitzak,
urrundu gaitu eta kolpatu
ostu dizkigu irritsak,
nahiz  deserriak uzten dituen
harremanak lar murritzak,
albokaz eta xarmaz ditugu
berreskuratuko ditxak.



4
Erromeria era dezagun
bizipoza suspertzeko,
Franco ankerrak eragin zuen
mina, ezti sendatzeko,
laztan igoko gara kemena
arimetan indartzeko,
albokarekin izan ginena
naturalki garatzeko.

5
Goizean gara oinez hasiko
gaindituta garai basa,
esango dugu irribarretsu
“jai hau bai dela demasa”,
albokaz, bertsoz eta abestiz
egingo da egun-pasa,
sentimendua eta musika
euskaldunaren arnasa.

6
Albokaria doa aurretik
doinua ozen hedatzen,
artez erritmo sarkorrarekin
umorea bideratzen,
gazteak bere atzetik doaz
kopla zaharrak kantatzen,
sufritzen dauden bihotz xaloak
ari direlako batzen.

7
Albokaria sartu da plazan,
hegan joan dira usoak,
doinuak aldiz ipini ditu
dantzan alboen hostoak,
poz hori nahi du itxaropentsu
amesten duen presoak,
noizbait kutunki etorriko den
iheslari fier zintzoak.



8
Alboka eta panderoekin
lehertuko da zirrara,
bular aldean piztuko zaigu
zorionaren dardara,
ibil dezagun biok geroa
heldu gura nuke hara,
ailegatzeko goxo batera
amnistiaren festara.

2014ko martxoaren 9an

## 351
## Telefonoaren bidez elkartzen garenean

1
Astero deitzen dizut esperantza konpartitzeko,
zure ahotsak bizipoza opatzen didalako,
sarri diot pagoak zuk esan dezazun Arrate,
gure altxorra ikusteko gogoa dudalako,
galdetuta "noiz arte?" erantzuten duzu goizean,
gauaren ostean egunsentia datorrelako,
diodanean kartzela latza diozu herria,
gaurko zigorra bihar zirria izango delako.

2
Gaur esan dut geroa eta zuk esan duzu poza,
askatasunean berriz elkartuko garelako,
esan duzunean lorea esan dizut zirrara,
jaioko den udaberrian egon nahi dugulako,
giza Eskubideak aipatu ditugu argiro,
Euskal Herriak justizia eskatzen duelako,
"euskara!", ozen esan dugu esateko geurea,
maitasuna hitz ederrekin zertu genuelako.

2014ko martxoaren 16an

**352**
**Carlos Urquijo eta “K” hizkia**

1
Urquijo eta Urkijo berdin ahoskatzen ei dira,
Urquijok ez du maite ordea Euskaltzaindiaren “K”,
euskal herritarra den arren “Q” hizkia hobesten du,
espainola omen delako bere bihotz eskuindarra,
tamalez bera “K” da gure kontra oldartzen denean,
kirrinka dabiltza berarekin giza eskubideak,
kriminal genozidak antzo dabil euskara zigortzen,
korrok dagi ikurrina udaletan aske badago.



2
Krudela eta karraska da presoen etxekoekin,
koldarra herritarren hitzari beldurra diolako,
kolera hutsa gatazkaren sua gura duelako,
kirtena zapalkuntza bortitz bultzatzen dabilelako,
kaltegarri horrek herraz, maltzurki kastigatzen gaitu,
korrika salatzen ditu abertzaleen iritziak,
bakean utz dezala behingoz arbasoen sorlekua,
joan dadila pikutara “Q” letra zapla irentsita.

2014ko martxoaren 16an

## 353
## Gaztea eta iraultzailea

1
Denok noizbait gazteak
izan garelako,
Mundua irauli nahi
izan dugulako,
onar dezagun orain
direla holako,
utopiaren lurra
xede dutelako,
herri justuago bat
lor daitekeelako.

2
Euskotarra da jaio
delako Eibarren,
iraultza laket zaio
ume bat den arren,
Euskal Herri xumeak
jartzen du pozarren,
berdintasunak lez nahiz
aipatu bigarren,
geure Arratek zenbat
onura dakarren.

3
Gaztetxoa Mundua
ari da orrazten,
elkartasuna zuzen
gogoan marrazten,
jakintza doakio
ikastolan hazten,
hainbeste kulturekin
sano aberasten,
arrazismoa zaio
haizatu jolasten.

4
Pozik bizi nahi luke
handitzen denean,
gabezia baztertu
zart elkarlanean,
argia beharko du
naro garunean,
bakea isiotzeko
bortxen oihanean,
herria osa dadin
askatasunean.

5
Nerabe hura dabil
plazak akuilatzen,
jendartean dihardu
ideiak garatzen,
erraza ez delako
sarritan asmatzen,
kideekin ari da
geroa goldatzen,
aberriaren alde
kontzientziak batzen.



6
Gaztea dantzut goxo
euskaraz mintzatzen,
euskal nortasuna du
dotore islatzen,
auzolana dihardu
zintzoki sustatzen,
jendeari eskuak
jatorki opatzen,
herri txikien xarma
ederki hedatzen.

2014ko martxoaren 23an

## 354
## Maitasuna naturala delako

1
Maitasuna denez garrantzitsuena
gizakien sentipenik ederrena,
hona hemen gaurko ezkontzen ordena:
gizon hauena izango da lehena,
ondoren gizona eta andrearena,
azkena berriz emakume haiena.
Ez dezala herrak hautsi politena,
desioak estuki batu duena,
bihotzak bilatzen ibili direna
plazera konpartitzeko hoberena,
sexu berekoen harremanarena
ez delako izan inoiz hobena.

2
Eurentzat bada egunik alaiena
garai berri baten hasierarena,
laztanak soil badira erakuspena
zentzuz hartutako hautapenarena,
nor gara gu bihurtzeko poza pena
esateko zer den egin behar dena.
Ez delako egia elizarena
edota zitala den eskuinarena,
baizik norberaren sentimenarena
emozioen iturburuarena,
babes dezagun tinko adierazpena
aratza den giza izadiarena.

2014ko martxoaren 30ean

# 355
# HEGAZTIAK HAMAHIRU
## Pauma naturala eta faltsua

1
Izadiako pauma estimatzen dut
ez du joerarik inor asaldatzeko,
jendarteko pauma dirudunak aldiz
harroki dabiltza zer jantzi hautatzeko,
eragabeko luxua erakusteko
irudiaren modari men egiteko.
Artistak, burgesak eta kirolariak
jaietan biltzen dira nia hauspotzeko,
frak, soineko eta bitxi asko dituzte
buru txolinak  lotsagarri goratzeko.

2

Pauma dotore dakusat izadian,
dirdai dago eguzkiaren izpiekin,
lumazko gandorra eta isatsarekin
ikusgarriak dira bere pasierak,
arrak darabiltza emea limurtzeko

berezko dituen kolore biziekin.
Paumak jantzi bat dauka bizi osorako,
larrua babesten dio era duinean,
ez du antzezten jardun behar izateko
natural higitzen da edertasunean.

2014ko martxoaren 30ean

## 356
## Mirori Untzagako plazatik

Kideko emadazu konpromiso izenaren sinonimo bat,
arkatzaz marraz ezazu eskuzabaltasunaren irudia,
esadazu, zer izen jarriko zenioke elkartasunari?
Zelan ahoskatuko zenuke maitasun berba plaza honetan?
Nor aipatuko zenuke zirraraz askapenaren egunean?
Nork mereziko luke adiskide, iraultzaren ereserkia?
Halaber errepublikar zintzoen omenaldirik ederrena?
Zein sentituko dugu alboan honelako urteurrenetan?
Miro, non batuko gara zurekin? Izan dadila bihotzetan
gure Alicia, Roberto eta gainerako krabelinekin,
Zu Miro zoragarria izan zara preso dagoenarentzat,
zure antzekoei esker jaioko da denon Euskal Herria.

2014ko martxoaren 30ean

## 357
## Ez Dok Hamahiru ez dadila hogei izan

1
Hamahiru zenbakia
omen da zatarra,
ustez dakarrelako
soilik adur txarra,
kartzelan ez dirudi
denik hain kaskarra,
bertan delako ia
dena zoritxarra.



2
Hamahiru urte jada,
dirudi gezurra,
ezagutu nuela
kartzela makurra,
nahiz iruditzen zaizun
bizitza papurra,
oroitzak dakarkizu
bizipoz samurra.

3
Kartzelan behin esnatu
ei da ezbeharra,
mila bider gertatzen
denean sukarra,
ametsetan nigana
dator ostadarra,
ater dakidan arin
ariman negarra.

4
Hamahiru urte luze,
hau bai malura!
Poliziak zidala
ebatsi onura,
aberria eraiki
dugulako gura,
gatazka konpondu da
gaur dudan azkura.

5
Ondo sufrituta dut
zapaldu gailurra,
kartzelaldi gaitzaren
erdiko muturra,
orain hurrago dago
maite dudan lurra,
beheratzea izan
dadila laburra.



6
Hamalau zein hamabost
dira etorriko,
hamahiru lez nik ditut
kartzelan biziko,
gogoa da ordea
hantxe ibiliko,
nongoa naizen ez dut
inoiz ahantziko.

7
Kideekin aise dut
pena gaindituko,
eurekin bainaiz noizbait
aske geratuko,
esperantza ederki
zaigu loratuko,
batera dugulako
xedea lortuko.

8
Urriak hamazazpi
data berezia,
sentitu nuen zer den
bortxaren gezia,
Aietek isildu dit
oro eresia,
zimela bihurtu du
mardul gerezia.

2014ko apirilaren 6an

## 358
## Rajoy ostruka eta Catalunya

Rajoy ostrukak arazoa ekiditeko
burua lurpean sartu du ostentzeko,
Diadaren giza katetik at mantentzeko,
Espainiaren hausturaz ez pentsatzeko,
Catalunyak tinko darrai aurrera ordea
bortxaz kendu ziotena eskuratzeko.
Katalanek ikusgai jarri dute senyera,
estatuak zio bat dauka kezkatzeko,
otoi, ez ditzala ergelki begiak bildu
ostrukak lez datorrenaz ez jabetzeko,
hobe delako hitzaren giltza erabili
herrien Europa min barik erditzeko.

2014ko apirilaren 13an

## 359
## Zeure mina sentitzen dudalako

Aspaldian oinazea ezin kendu barik zaudelako
zail egiten zaizu arantzen zolan egon irritsu,
patxadaz ibili behar zinateke pozik bizitzeko
ez delako erraza minez sentitzea zoritsu,
bakardadeak ez dizu egoera ontzeko laguntzen,
etxean baino hobe da kalean jardun berritsu,
har ezazu arnasa lasaiki estresari garaitzeko
taupadak  arituko dira horrela neurritsu,
urretxindorrak  egin dezala kabia zure logelan
geroaren bidea bihur ez dakizun harritsu,
txorrotxioekin itzul dadila joandako bizipoza,
esna zaitezen txoritxoa lez kantuan arraitsu.

2014ko apirilaren 13an

## 360
## Hamaika desira eta xede bat

1
Bakardadean dagit
sarritan negarra,
barnean zaidalako
kiribildu harra,
zeu zapaturo zinen
neure ostadarra,
zeure berbak entzun zen
neuretzat beharra
espetxean zenidan
urtzen antzigarra.

2
Zeure ahots guria
ezin dut aditu,
bizitzak dizulako
irria hotzitu,
arren, amildegi hau
ekinez gainditu,
deuseztatu gandua
gogoa bizitu,
telefonoa hartu
lilura sentitu.

3
Psikosiak ohi dakar
nahasmen mingorra,
beraren mende dena
dirudi ezkorra,
tristuraren dorrea
delako gotorra,
bakartuta zu zara
izango lehorra,
enpatia landuta
aldiz maitekorra.

4
Eguzkia nahi nuke
zugana igorri,
izpiekin orbela
bihur dadin orri,
atseginak lor dezan
berriro etorri,
zirrara ekarrita
zaitzan brau sokorri,
gaurko gaumina alda
dakigun oskorri.

5
Pentsamenduan dabil
aizkora zorrotza,
mozteko prest erori
zaizun ereinotza,
xaloki dakarkizut
ametsen pagotxa,
ekiditeko sano
kolpearen hotsa,
argi dakizun oro
inguru laiotza.

6
Ziegatik presaka naiz
idazten hegatu,
esperantza nahi dizut
ariman sustatu,
nahi dudalako zeure
mina oneratu,
sentieran daukazun
zauria osatu,
geure xarma suspertu,
hitzekin bazkatu.

2014ko apirilaren 20an

## 361
## Gizotsoak kartzelan jarraituko du

1

Gizotsoa oldartu da txitean-pitean
pilulekin sutzen delako ezinbestean,
giharrak ei dituelako indar betean
seguru dago bera  bere handiustean,
berba egin baino zaunka dagi etxartean,
neurosiak kalte egin dio konortean.



2

Borrokan burugabe parte hartu ostean
zigorra emendatu diote bat batean,
goibel dago harroa komunen atartean
lotuta iraun behar duelako katean,
zerrautsa duenak kaskezurraren tartean
nekez izango  da gizakia jendartean.

2014ko apirilaren 27an

## 362
## Lampedusa, Ceuta, Melilla... europarren lotsariak

1
Gaur egun uharte ilun bat da Lampedusa
bihurtu dutelako heriotzaren musa,
itsasgaina denez ito direnen geruza
arrantzale duina dago jota malerusa,
afrikarra berarentzat ez denez ezdeusa
ezin sorotsita sentitzen baita ezgauza,
Europak ez dezala Afrika errefusa,
demokrazia erruki gabe zikin usa.

2
Mugak ezartzen ez dezala inork abusa
ukatuz edonon bizitzeko estatusa,
ito dadila egoismoaren birusa
ziplo desager dakigun gabezien kausa,
goseak egon ez delako edozer gauza
baizik guk pobretutako herrien harlauza,
elkartasuna baztergabe dezagun luza
Lampedusa izan dadin bidaiaren pausa.

2014ko apirilaren 27an

## 363
## Kalamuan libre egongo naizelako

1
Kalamuan, zeruan
dago eibartarra,
goitik urrun dakusa
porlanaren marra,
ihintzak duenean
laztantzen belarra,
taupaka sano zaio
hanpatzen bularra.



2
Kalamuak ninduen
kitzikatzen baiki,
goiz eguzkitsuetan
zain neukan galaiki,
berarekin nintzen ni
elkartzen jarraiki,
aisia emateko
mendian lasaiki.

3
Kalamuan nengoen
patxada onean,
ikusmira eskertuz
tontor apainean,
txistuka nintzen hasten
harkaitzen gainean,
liluratuta hango
edertasunean.

4
Pozarren ditut garai
haiek gogoratzen,
ilargia denean
ortzian esnatzen,
Kalamua gehiago
nuen estimatzen,
udaberria jori
zenean loratzen.

5
Kalamuak duenez
gertu itsasoa,
miraz zuzentzen nuen
Kantaurirantz soa,
udaran handik dator
haizetxo gozoa,
eskaintzeko eztiki
atsegin osoa.

6
“Kalamua!”, esan dut
minez arimatik,
ezin naizelako joan
danga kartzelatik,
hanka dagit ordea
amesten ziegatik,
natura ikusteko
bere talaiatik.

7
Preso egon aurretik
negien erara,
Usartzatik igoko
naiz Kalamuara,
sentitzeko borborka
orduko zirrara,
gurtzeko joan zirenen
zelai berdekara.

8
Tontorretik jaitsita
lubakietara,
Kalamuatik joko
dut Akondiara,
garoak preziatuz
gero Aitzketara,
Arraten esateko
“libre bizi gara”.

2014ko maiatzaren 4an

## 364
## Anaisi bihotzetik

1
“Maitasuna da bide bakarra”,
idatzi duzu adoretuta,
halaber “maitasunetik dagigu
borroka”, senak eskatuta,
zure mezua gurea delako, bat
gatoz kartzelan zurekin,
zu bezala bizipenak ari gara

konpartitzen Arkaitzekin,
herri bat izan nahi dugulako
aspalditik gaude lar sufritzen,
horregatik elkartzen garenean
bihotza zaigu txit hunkitzen,
ez dugu nahi ankerren eran
gorrotoa jendartean ziztatu,
hobetsi dugu gatazkaren
konponketa maitasunez sustatu.

2
Lubakiak laga nahi ditugulako
estalita bazterretan,
haize berriak itxaropena ereiten
dihardu alorrean,
kitzikatu gintuen ideala ernatu
zen maitasunean,
bertan daude iraganean joan
zirenak taupaka orainean,
geroan horrela jarraituko dute
gurekin harremanetan,
Arkaitzekin ta eurekin
sentituko dugu zirrara plazetan,
borroka dagielako maitez ta
musu-truk sentimental finak,
pozarren diot, herrian bizi
direla krabelin gorri minak.

2014ko maiatzaren 11n

**365**
**Ziega barrutik hormari beha**

Pagoaren adarretan Mundua irudikatzen
zegoen nerabea pozik udako goizetan,
espe zintzoa sentimental dago hormari beha
oroitzan bilduta egun luzeen arratsetan,
bizi samarra zena garai zoriontsu haietan
zigortuta daukate herraren atzaparretan,
zeru ederra mendian mugagabe zekusanak
ez du ia ikusten isolamendu horretan,
ohean amesten ditu orduko egunsentiak
txolarreak hasten direnean txortxor hizketan,
bihotz gaixoa gozatzen zaio une horietan,
haur arima ez zaiolako histu kartzeletan.

2014ko maiatzaren 11n

## 366
## Madibaren eredua hilezkorra da

1
Lehoiak ari dira orroka
adierazteko samina,
ilunki daude bart hil delako
Madiba, gizaki mina,
nonahi izan zen duin eredua,
presoentzat pipermina,
Mundua zuzen ontzeko zigun
eskaini bere dohaina,
euskaldunok maiz genion zinez
eskertu ahalegina.

2
Nelson Mandelak nahi zuen zintzo
elkartasuna garatu,
Hegoafrika txukun margotu,
berdintasuna sustatu,
tinko zituen Apartheidaren
lege zitalak urratu,
ziegatik gero hormak gaindituz
kontzientziak zirt esnatu,
jendarte berri bat eratzeko
herriak borrokan batu.

3
Zu terrorista bat zinen soilik
agintari zurientzat,
halaber euren jarrera zuten
larrainen kolonoentzat,
zuk argi esan zenuenean
“lurralde hau da denentzat”,
arrazismoa geratu baitzen
ezgai estatuarentzat,
txoriak hasi ziren txioka
ortzadarraren haurrentzat.



4
Obama, Rajoy eta Hollande lez
doa Hegoafrikara,
inperialista ziztu bizian
iritsi da hiletara.
Zu hipokrita, Europa beste,
herrien katea zara,
ez da zurea Johannesburgon
sentitzen duten zirrara,
bihar Munduan jendarme barik
ederki biziko gara.

5
Nelson Mandela Soweton dago,
jendea doluz kantari,
jarraituko du kale horietan
izaten gorri gidari,
luze egon zen Robben Islanden
begira itsasoari,
aztertzen nare nola lagundu
zapalduen herriari,
ekinez zion sena zuzendu
arrazista makurrari.

6
Nelson maitea zure irria
berpiztuko da geurean,
udaberriak sortuko duen
askamenaren lorean,
zure mezuak ta idatziak
dabiltza libre airean,
iraultzaileak jasoko ditu
ideia onen sarean,
paradisua sustrai dezagun
basamortuko harean.

2014ko maiatzaren 18an

## 367
## Euskal Bidean hasi gara

1
Atzo lez herrigintzan ari dira iraultzaileak
pobrezia elkartasunaz oro murrizteko,
euskara irten dadin bihotzetatik plazetara,
berdintasunaren zentzuaz umeak hezteko,
euskal kulturaren arbola janzteko fruituekin,
gatazkaren tunela zuzen jardunda ixteko,
mendiak, haranak eta itsasoa babesteko,
biharkoei etxe feminista bat uzteko.



2
Libre bizi gura dugu euskal bidean sartzeko
onuraren alde sorlekuan lan egiteko,
hegan hasiko gara estatuen kaioletatik
helburuak zuekin artez ehuntzen hasteko,
jendarteak behar duen pizkundea eratzeko,
amnistiaren goiztiria gozo ikusteko,
lurraldea iratzar dadin dirdaitsu egunero
txorien txorrotxioak lokabe entzuteko.

2014ko maiatzaren 25ean.

## 368
## Satorraren bizimodu naturala

1
Kubilean dago sator ehiztaria
intsektuak janda bapo lo zorroan,
ile leungo ugaztun txikiari
baserritarra zaio gaur haserretu,
baratza diolako ia kaltetu,
zelaia ohiko lur pilekin zatartu,
aitzurra igarrita, badaezpada,
hanka egin du kumeekin batzeko,
eskuetako behatzen azazkalez
aztarrika ibiltzen ei da lurpean,
zulo bideak egiten nahitaezko
goiari on eutsi ahal izateko,
gustura egingo lituzke zuloak
presondegi zatarrak hondoratzeko,
zuzentza lurpetik azalarazteko,
hainbeste miserable lurperatzeko.

2
Satorra erabat itsua den arren
ezagutzen du jendartearen martxa,
"sator lana dagi bankariak" dantzu
"zimelduz ongizatearen loreak,
etxe barik uzten herritar xumeak,
diruak ostenduz 'paradisuetan'".
Ahalko balu lagunduko liguke,
ilunpetik aterako litzateke
esateko, "Ekia denona bada,
hola beharko luke izan onura,
jaio garelako libre bizitzeko
eta ez gabezian kateatzeko".
Gaurko Mundu-Tunel hitsak behar ditu
argi printzak berekoiak zentzatzeko,
bizimodua maitatzen hobetzeko,
satorrak lez naturalak izateko.

2014ko maiatzaren 25ean

## 369
## Sopuertako eibartar onberari

1
Aspaldian esan zidaten zela
Alzheimer zure izena,
agertzen zaren inguruetan
errotzen da etsipena,
zurekin sorgor geratzen baita
gizaki bipila zena,
zergatik uzten duzu etenda
burmuinaren ahalmena?

2
Buru azkarra ohartu barik
zaizunean maiz nahasten,
absentziaren ganduan zara
hasiko laster narrasten,
zure kalea eta etxea
dituzunean ahazten,
begitartean joango zaizu hits
gaixotasuna marrazten.

3
Gurpil-aulkian isilik zaude
zure baitan ostenduta,
lehengo begi berde biziak
orain dituzu hilduta,
zaudelako hor nonbait galduta
kemena dut ahulduta,
ez duzulako ezer esaten
sentimena goibelduta.



4
Medizinak gaur ezin duenez
zure gogoa argitu,
maitasunez nahi dugu nolabait
atsekabea gainditu,
beharbada ez dituzu gure
ezpain leunak sentitu,
baina musua dizugu oro
laztanez eder gorritu.

5
Min barik zendu zara maitea
atseden gozo hartzeko,
Ama-Lurraren altzo beroan
xaloki aterpetzeko,
goiari behar diogu eutsi
zure nahia betetzeko,
gura duzun lez irribarretsu
ametsetan agertzeko.

6
Zu izan zinen gure txokoan
bihoztunen gidaria,
amnistiaren alde borrokan,
sustatuz langileria,
ez dira zure hitzak entzungo
agortuta emaria,
aldiz, ganbaran dugu mataza,
zure ideien haria.

7
Oroitzen zaitut nonahi mintzatzen
aberriaz kezkatuta,
Mundua ondu zen helburua
klaserik gabe zertuta,
niniak ditut hezetsu, zure
argazkian pausatuta,
“herrian libre biziko gara”
esan dizut hunkituta.



8
Alzheimerrak zizun aurrean
jarri ziplo errezela,
zurekin kide zahartzaroa da
tamalez izan krudela,
jakin ezazu tinko zarela
gure ontziaren bela,
utopiaren lur oparora
ailegatuko garela.

2014ko ekainaren 1ean

## 370
## Gaur eta bihar euskaraz bizi nahi dut

1
Euskaraz entzun nahi dut irratia
halaber noizean behin telebista,
horren faltan makal nagoelako
ezin gozatu barik sentimena.
Urruti nago ziegan giltzatuta
isolamendu beltzuri batean,
herrak eraiki zuen mendekuan
hainbat kide mazalekin batera.

2
"Euskaraz bizi nahi dut" dio sarri
nire nortasunak bakardadean,
"gure kantuak aditu alboan
txorienak antzo goiztirietan".
Alderrai joaten zait irudimena
oroitzeko orduko bizipoza,
geroan naro sentituko dudan
sorterriko mintzairaren plazera.

2014ko ekainaren 8an

## 371
## Harrera gure zain dago

1
Mandoen bide estu malkartsuan gaude
igotzeko Hirusta tontorrera,
izerditan dauzkagu bizkar zamatuak,
eguzkia jaiki da alegera.
Kide, zure arreta zuzen ez dadila
lasterbide faltsuaren aldera,
hortik ez zarelako gora iritsiko
baizik porrotaren ezerezera,
txukatu kopeta, hartu sakon arnasa,
barreiatu onura bularrera,
aditu soseguz bihotzaren taupadak,
segitu eurekin lerden aurrera.

2

Agindu bat genuen onartu gogoan,
“asmoa ez laga bertan behera”,
haize freskoak atzetik jotzen duenez
ez dugu egingo makal atzera,
ikusmirak laster erakutsiko digu
txoko maitearen gainazalera,
berde eta menditsua iparraldera,
laru eta laua hegoaldera,
oinak dagoeneko azken maldan daude,
animoak egin baitu hobera,
jendea goian dago gure zain kantari
“gu gara zuen herriko Harrera”.

2014ko ekainaren 8an

## 372
## Erleak erlauntzean lez jardun zarete

1
Soko eta Begoña badoaz gurekin segitzeko
trebakuntzaren jakintza gazteei uzteko,
ardurak ohi duten antzo biribil burutu dituzte
Eibarren alde zuzen, plazerez behar eginda,
zinegotzi berba aratza dela erakutsi dute
zintzotasuna zer den musu-truk irakatsita,
eibartarrok badugu zeri begiratu hobetzeko,
euren jarrerari esker onberagoak gara.



2
Feministen, euskararen, beharginen... lagun fidelak,
pozarren  aitortzen dizuet nire mirespena,
kartzelaren kateak hautsita kraska lagatakoan
eredu natural horri jarraitu nahi nioke,
azken hiru urteetan gozoro, arnasa izan zarete,
hor zeundetela jakinda arindu zait zigorra,
gaurko amets askatzaileak zertuko ditugulako
Untzagan noizbait atseginez elkartuko gara.

2014ko ekainaren 8an

## 373
## Ametsetik esperantzara eta, gero zurekin, atseginera

1
Nahiz kaioak gugana
datoz samaldaka,
mokoak zorroztuta
ozen karkailaka,
ez dugu onartuko
bizi arrastaka,
aurre, lehiaz egingo
diegu tiraka,
arrazoiak herrian
azalduz dandaka.

2
Martxan hasiko gara
xedea lortzeko,
Kaioen erasoa
ezdeus bihurtzeko,
guk ez dugu beldurrik
bidean galtzeko,
ikasi dugulako
zer egin heltzeko,
ikurrina plazetan
libre astintzeko.

3
Tamalez goizean zait
ametsa lausotu,
burmuinean ziplo da
hor nonbait lerrotu,
eguzkiak aldiz dit
eguna girotu,
neure begitartean
irria umotu,
konponketaren nahia
delako errotu.

4
Animoa dirdai zait
gogoan argitu,
aurrera segitzeko
kemena goritu,
hitzarekin nahi dugu
gatazka itxitu,
giza eskubideez
bakea kausitu,
urtetako samina
zintzoki eztitu.

5
Esperantzen zoruan
zaitut gogoratzen,
xumea zarelako
gehiago preziatzen,
elkartuko garela
has zaitez pentsatzen,
aditu alegera
herria kantatzen,
zigorren amaiera
delako sumatzen.



6
Atsegina zurekin
dut konpartituko,
estresa orduan zait
aise sendatuko,
maitasunak leunki
gaitu askatuko,
harremana dotore
zaigu izartuko
bitartean xarmatik
dugu jarraituko.

2014ko ekainaren 15ean

# 374
# GURE ESKU DAGO I
## Apustua

"Gure esku dago" pentsatu dugu
erabaki burujabetza,
estatuekin konpondu gatazka
garbitzeko behingoz lupetza,
lege okerrak kenduko ditugu
lur hau bakean hobetzeko,
aberastasuna konpartitzeko,
euskaraz uros bizitzeko.

Hurrengo asteetan adoretsu
bilduko gara herrietan,
apustuak merezi duelako
xedea dugu gogoetan,
zernahi hautatzeko borondatea
demokratikoa delako,
Mundua  ekimen eder honekin
zerbait ondu litekeelako.

Durangotik Iruñera joango da
eskuekin gure zirrara,
irten gura dugulako hegazka
ilunpetik izarretara.

2014ko ekainaren 22an

## 375
## Arnas-guneak euskararentzat

1
Lurra goldatuko dugu hazia naro ereiteko
gose dagoena gariarekin asetzeko,
eskuzerra hartuko dugu bihotzaren biltegitik
debekuak mozteko zokoratzen dutenari.
Ager daitezela zeru ilunean hodeiarteak
eguzkiak beltzarandu dezan larru zurbila,
diglosiaren mortuan oasi bat jaso dezagun
mingainek izan dezaten listua mintzatzeko.

2
Sukaldeko supazter gozoa eskainiko diogu
bazter laiotzean izoztuta egon denari,
euskarak maitasuna behar du sasoitsu bizitzeko,
atzo tamalez zarpailduta laga zutelako,
haritzak behar ditu gaztelaniaren pinudian,
lore gorri mardulak frantsesaren sasidian
arnas-guneak susper dadin hilduta dagoelako,
axolagabe gal ez dezagun “euskaldun” hitza.

2014ko ekainaren 22an

## 376
## Eguneroko konpiak

1
Kontxo! Ekonomatoan
“konpiak” dira bildu,
ilaran nago, beharrez
naizelako hurbildu,
denak zaizkit hurreratu
inor ez da kikildu,
“kafe bat arren!”, leloa
garesti dut isildu.

2
Kafearen, zigarroen
eta drogen zaleak,
lotsabakoenak dira
talde horren aleak,
etxartean adi daude
horrelako jendeak,
dirudi garela euren
etxekoen ordeak.

3
Ezin zara txukun jardun
dirua gobernatzen,
ez dituzunean zentzuz
zure grinak bezatzen,
ondasunak dituenak
mugagabe gastatzen,
aldats behera du taka
bazterrean bukatzen.

4
Eskaleen zergarekin
urdaila zait ozpindu,
patrika didatelako
kafeekin arindu,
ez dago zergatik petral
hola behar samindu,
baikor aritu nahi nuke,
nortasun beltza duindu.

5
“Txo, izan zaitez emaile”
esan dit kontzientziak,
“Kartzelan zerbait ontzeko
presoen miseriak”,
gertu nengoke, pozarren
zertzeko euren nahiak,
ez balira gehienetan
izango huskeriak.

6
Gauean atsegina dut
izaretan aurkitu,
ametsetan dudalako
ernegua lasaitu,
xaloki gura nioke
senari obeditu,
sentimendu onberari
adoretsu segitu.

7
Elkartasun loria da
kartzelan ortzadarra,
egoismoa ordea
mingarri kazkabarra,
besarkadak hobetzen du
egoera kaskarra,
mozten duelako putzu
hauetako laharra.

8
Eskatzen duenak nahi du
guraria konplitu,
kartzelan pairatzen duen
ondoeza gutxitu,
gaur berriz ditugu gogo
beltz-urdinak hunkitu,
lur jota dauden presoen
zeru grisak argitu.

2014ko ekainaren 29an

## 377
## Geurea hamaika koloretako lorategia

1
Geroa gogoz gabiltza prestatzen,
alai eta irrintzika euskaraz,
oinez tai gabe bidean sartuta
kontzientzia nagiak txit sustatzen,
mapa txukun ari gara marrazten,
lurralde zoragarria ereiten.
Estatuak gure aurrean daude
helburua galarazteko asmoz,
lubaki bat egiten ari dira
jarrai dezagun luzaro sufritzen.

2
Ametsa zuzen dihardugu zertzen
mendekua isil dadin geurean,
atzean, urrun lagako ditugu
lubakian garrasika daudenak.
Zentzuz, biribil atonduko dugu
borrokarik gabeko eremua,
eskubideak sendo bermatuta
biharko herri solidarioa,
hamaika kolorerekin denontzat
lantzen ari garen lorategia.

2014ko uztailaren 6an

## 378
## Bortxatzailearen kontra, feminismoa

1
“Zakilak ustelduko ahal zaizkie!
Lizunkerian itoko ahal dira!”.
Neska bat bortxatu egin dutelako
esan duzu erabat amorratuta.
“Munduan tokirik ez duten izango
matxista nazkanteak berriro ere!
Euren sentimena ankerra delako
boteretsuak sentitzen direlako”.
Hola egin dut oinazez bat zurekin
krakari ateak hertsiki ixteko.

2
Neskatxa dute ilunki hondoratu,
lili mardula basatiki zimeldu,
begiak negarrez gorritu zaizkio,
bihotza diote izuaz uzkurtu.
Bizipoza lar hilduta duen arren
dir-dir berpiztuko da txerei esker,
esango diogu eskuak eskainiz,
“Matxismoa dugu lurpean sartuko,
hari moreaz josiko dugulako
generoen arteko berdintasuna”.

2014ko uztailaren 6an

## 379
## Ixuako txirtxila

1
Txirtxila geldo dabil kaiolan
arin zebilen Ixuan,
nabaria da ez duela nahi
biziraun etxe barruan,
uraza pixka bat jarri dugu
jan dezan toki estuan,
ogi mamia ardotan busti
has dadin mozkor kantuan,
egonezinik dago gaixoa
gatibu baten moduan.



2
Txirtxila ez zen mendian jaio
naturatik at hiltzeko,
etxe bateko bakardadean
egunak igarotzeko,
Ixuan egon beharko luke
hegoak fier torratzeko,
uda sasoian aldiro kri-kri
belardia girotzeko,
bere intsektu espeziea
arrakastaz ugaltzeko.

3
Kili-kilia sentitu zuen
kantuz ziharduenean,
ziri batekin egin zioten
zuloan zegoenean,
umeak zeuden adi bere zain
ziplo atera zenean,
gertu zeukaten kutxa txikian
sartu zuten ezinean,
isildu egin zen Ixuatik
baldar zeramatenean.

4
Ezin dut jasan hola ikusi
Ixuako intsektua,
bizitza oro diogu txartu
bilakatuta mortua,
Ikerri diot gero esango
kezkatzen nauen kontua,
negarrez hasi izan daiteke
beraren arrapostua,
baina garbiro adierazita
ulertuko du hautua.

5
Zelaira gara batera igo
goizaren hastapenean,
Ixuan lasai gaude bakarrik
aske uzteko unean,
Iker, adostu dugun bezala
sukaldean geundenean,
goxo diogu biok esango,
“Txirtxil hoa zuzenean,
hire kantuak jaso dezala
erantzunik gauminean”.



6
Txirtxila bizkor aldendu zaigu
txoko ederraren bila,
ez du izango neke handirik
berez delako abila,
abuztuaren ondoren nare
ailegatu da iraila,
negulehena beharrez dago
prestatzen izaki pila,
Ama-Lurrek jo dezan gerora
udaberriko ezkila.

2014ko uztailaren 13an

# 380
# GURE ESKU DAGO II
## Arrakasta

1

"Gure esku dago" behar den lez konplitu, egin dugun zina,
Munduak entzun dezan eskaera zuzen atsegina.
Eguzkiarekin ekinaldia izan da oro bikaina,
arimek parte-hartuz eskertu dute ahalegina.
Herri Baltikoek aspaldi zuten giza katea mamitu,
Kataluniak zion iaz praktikari zintzo jarraitu,
ekainaren zortzian Euskal Herria batuta da mugitu,
etorkizunean bizirik nahi duelako segitu.

2

Ehun eta hogeita hiru kilometro prest kateatzeko,
Durango eta Iruñea eskuekin elkartzeko,
mehatxu barik zer izan gura dugun gardenki hautatzeko,
demokrazia hitzarekin ontzen dela goratzeko.
Bertan zein kanpoan jaio garenok osatu dugu ilara,
xedea lortuta batera gaude gozatzen zirrara.
Ezin izan dena egon amets batekin bete du otzara,
“Halako bihotzekin erbestetik itzuliko gara”.

2014 uztailaren 20an

## 381
## Psikopataren mendean zegoelako

1
Harrapariak harrapakina hil du,
lar erraza iruditu zaiolako,
psikopatak hautsi dio esperantza
ez diolako guraria konplitu,
txikitu dizkio buruko hezurrak,
erraiak anker birrindu ostikoka,
kaiola berean zeuzkaten itxita
zuzentza kartzelan sorgorra delako.

2
Gizajoa tamalez zerraldo datza,
eroa hor nonbait bakartuko zuten,
bere burmuina ezin konpondu barik
zigorra diote itzel luzatuko,
kulpa berea beste, klar dago dela
kartzelara bidali zuenarena,
psikopata bat ezin delako batu
etxean maitea zain duenarekin.

2014ko uztailaren 20an

## 382
## Maiatzak 26. Astelehen magikoa

1
Gogara dantzut ohetik
hormatxorien kantua,
goizero eratzen dute
teilatupeko korua,
mueslia, ura, jogurta,
intxaurrak eta pikua,
patxadaz nabil prestatzen
armosu zaporetsua,
txioak isildu dira
hel dadin zurrumurrua,
“atzo hunkitu egin zen
maite duzun sorlekua,
hauteskundeen emaitzaz,
golarekin Ipurua,
eta Euskal Jaixarekin
Untzagako ingurua.

2

Hauteskundeak Europan
onurari bozkatzeko,
baliatu nahi ditugu
eskuina ezeztatzeko,
Euskal Herriko xedeak
justiziaz ehuntzeko,
errenta han eta hemen
behar den lez banatzeko,
Eibarrek bere aleak
bidali ditu lortzeko,
etorkinei, minkorrak
diren hesiak kentzeko,
elkartasuna musu-truk
Munduari luzatzeko,
bankarien boterea
ezkerretik zimeltzeko.

3
Eibar Futbol Taldea da
brau igo lehen mailara,
halaber futbolarien
zirrara harmailetara,
izar barik heldu baita
distira Ipuruara,
gauak du miraz zabaldu
ortzian bere izara,
futbol zelaiko eztanda
hegan doa Untzagara,
handik sentierarekin
preso nagoen ziegara,
"txapeldun duina gaur neure
larmintza izango zara",
desira korrika joan zait
biharko euskal ligara.

4
Euskal Jaixa nahi dut zinez
jarraian irudikatu,
Untzagako atsegina
gogoan naro gozatu,
aurten dituzte danbolin-
jotzaileak gonbidatu,
Ezpalak, Kezka... ohi den lez
dira txukun arduratu,
kultura nekerik gabe
dutelako elikatu,
euskara dotore baita
hitz eta pitz plazaratu,
gaueko pozen aurretik
mementoa da gertatu,
Eibarri zaio bihotza
Larrain dantzan pilpiratu.

2014ko uztailaren 27an

## 383
## Erkoreka, Ortuzar, Atutxa... ez esan gezurrik

1
Erkoreka egia esan behar da
presoei bizitza on dakigun,
gezurrarekin herra xaxatzen duzu,
euskaldunen artean istilua,
hobe gurekin elkartuko bazina,
Rajoy eta Hollande higi daitezen,
jakin ezazu gogoz ari garela
gatazka demokratizatu nahian,
eman dugun urratsa zintzoa dela
denon herriaren alde gaudela.

2

Aizu, gure aberria izango da
batera erabakiko duguna,
zeurea ez dadila Kutxabank izan,
ezta porlana edo batzokia,
arren, isil itzazu berba makurrak
mendeku-zaleak darabiltzanak,
lan egizu Euskal  Herrira gaitzaten,
bakea eskubidean haz dadin,
zubiak sortzeko eta ez hausteko,
askatasuna elkar lor dezagun.

2014ko abuztuaren 3an

## 384
## Besoetako Ugaitzi

1
Ugaitz aldiro agertzen zara neure ametsetan
zure bizitzaren partaide izan nahi dudalako,
tamalez haur bat zinela nahitaez laga zintudan
Euskal Herria neguan aspaldi sartu zelako,
geroztik deserrian nago udaberriaren zain,
esperantza kartzelan arnasa izaten delako,
hitz dagigunean bihotza zait gozo pilpiratzen,
gaztaroa zabiltzala dastatzen dakidalako.



2
Egunsenti lar grisetan tristurak inguratzen nau
estresak dakarrelako gogora makina bat gaitz,
sentieran egoten zarenean neuri begira
osatzen zait garunean zirudiena sendagaitz,
isolamenduan erraza ez den izaten arren
baikor jaikitzen naiz zu ez zaitezen izan zorigaitz,
neure askatasuna bezainbeste desiratzen dut
zeure erara zoritsu bizi zaitezela Ugaitz.

2014ko abuztuaren 3an

## 385
## Seaska sostenga dezagun

1
Haurtxoei ken diezazkieke
sehaskatik maindireak,
mehatxu hori dauka zintzilik
barnean Falloux Legeak,
oilar zekenak frantsesarentzat
nahi ditu arto aleak,
berdin prefetak, dakarzkigula
txokora soilik kalteak.

2
Hendaian presaz du tribunalak
debekatu eraikina,
Seaskak behar duen egoitza
babesteko zeregina,
irakasleek dute nozitu
aginduaren zirina,
Frantziak dio euskaldunari
maltzurki mozten mingaina.

3
Postak, armadak, frantses eskolak...
euskara zuten higatu,
Parisek bere bulegoetan
plangintza zuen prestatu,
Seaska dugu maitez ordea
zoragarri baliatu,
haurtxo xarmantak polito dira
ikastoletan pausatu.



4
Baiona izan zen txarrerako
Frantziako gaztelua,
Errepublikak irentsi zuen
koroak lez sorlekua,
Seaskan dago sendo jasota
hitzaren iturburua,
euskaldun dezan ur emariak
ihartutako zorua.

5
Hendaian, Kanbon, Garazin, Ligin...
bizi dadila euskara,
zuzentzak ekar dezala naro
zentzua bazterretara,
handiki fierra begira dabil
gutiziaz Frantziara,
otoi, begiak zuzen ditzala
arbasoen sehaskara.

6
Noiz arte du minkor iraungo
Chauvinisten jazarpenak?
galdetzen digu penaz aldiro
herri honen sentipenak,
erdietsiko direlako brau
arrazoiaz onespenak,
haurrak batuko dira kantari
ezagutzeko lorpenak.

7
Iparraldeko jendarteari
pitz dakiola ganbara,
auzolanean ari dadila
antzinakoen erara,
zuri ditzala hodei onberak
kontzientziak mara-mara,
Larrunek entzun dezan goizero
haur alegeren zirrara.



8
Senperen sortu zen “Herri Urrats”
Seaskaren aldarria,
jai ospetsuak oneratzen du
zor astun nekagarria,
egun ederra baita desira
zentzudunen zutarria,
aintziran dugu bapo asetzen
arimaren egarria.

2014ko abuztuaren 10ean

## 386
## Elkartasuna den Arrateri

Artega egoten naiz zuekin batu arte,
maiz diot, “halako nekerik merezi ote?,
bidaian gerta liteke hamaika ezuste,
ordu txikietan makina bat buruhauste,
Guardia Zibilek kontrolak jartzen dituzte,
kilometroek hola itzelak dirudite.
Zeharkatu eta gero horrenbeste ate
laño zaude neure zain, mintzalekuan tente,
adei esan dizut, “ia dugu ordubete”,
zirrararen lurrunak du esparrua bete,
toki hauek oroimenik izango balute
kontu zoragarriak esango lituzkete,
amaieran tristatu zarelako hainbeste
zure begiek erabat inarrosi naute
aizu, desioek biziro iraungo dute,
nahi dugun goiztiria gertu dago Arrate.

2014ko abuztuaren 17an

## 387
## Zergak izan daitezen denon onurarentzat

1
Nora begira daude agintariak,
ustez zergen kudeatzaile argiak?,
zergatik ez dira gai lanik sortzeko,
gazteen nahiak ganoraz gauzatzeko?,
nola utz ditzakete langabezian,
buru jakintsuak zirtziltzen sasian?
galdetzen dut sentimenak behartuta,
krisia dela medio kezkatuta.



2
Dirua bidaltzen duzue bankura
porlanaren jabeak dezan  eskura,
industriak hartzen du soilik papurra
AHT delako zuen ikurra,
baserriak ia ez dauka hausporik,
ezta baztertuta euskarak gerorik,
arren, karguak laga  besteak beste,
Barcina, Urkullu erruki zaitezte.

2014ko abuztuaren 17an

## 388
## Isolamenduan gaudenok ikusi nahi duguna

1
Puertotik Kordobara
doa gogaketa,
“mortu bietan dago
sakabanaketa”,
hau, dirudien arren
ez da hurbilketa,
bertan delako zeken
dena murrizketa,
sarreran pairatu dut
ohiko araketa,
zerek gu gogaitzeko
daukaten kasketa.

2
Rajoy darraielako
irmo mendekuan,
Kordoban sartu naute
isolamenduan,
zorionez ez nago
soilik moduluan,
kideak nonahi daude
leotzen munduan,
egoten garen arren
zoko lar estuan,
alaitzen zaigu soa
batzeko orduan.

3
Beharrez nago ziegan
hormari begira,
halaber altzairuzko
arantza larrira,
nahiz kurloiak hor dauden
aske bizi dira,
hesitik gurtzen dute
goizeko dirdira,
eguzkiak eraman
nazala herrira,
Arratera joateko
pagoen zelaira.

4
Urruti gaudela da
egia bakarra,
sarritan dagi minez
arimak negarra,
kraska jausiko baita
hormatzar zabarra,
gure bizinahia ez
delako meharra,
ederretsiko dugu
noizbait artizarra,
katerik gabe libre
lurralde zaharra.

2014ko abuztuaren 24an

## 389
## Leihotik goizero dakusadana

1
Burdinsarea ezarrita daukan
leihotik dakusazu hurbil horma,
berari begira ikusmena gera
dakizuke lausotuta,
tamalez, hesi grisa bost metrotara
jaso zutenez hotz dagi ziegan,
ekia nekez sar daiteke zerak
daukalako zokoratuta,
txapel biribil zatarra altzairuzko
arantzarekin egin diote
Ceuta eta Melillan lez zauri
zaitezen trabatuta.

2

Segur aski arkitekto batek diseinatu
zuen isolamendua,
jakin beza gera zaitezkeela
psikologikoki gaixotuta,
gizatasuna desagertuta  dago lartxo
ziztrina den esparrutik
diziplinarekin eskubideak
dauzkazulako murriztuta,
txolarreek behintzat alaitasuna
dakarkizute txorrotxioekin,
une zoragarrian sorlekua dakusat
horman islatuta.

2014ko abuztuaren 24an

## 390
## Zarauzko ilobei

1
Nora eta Jon olatuen bitsa zarete,
berba dagigunean arnasten dut kresala,
une horietan bihotza pilpilka puzten da
garbiki dantzudalako Kantauri mazala,
ametsetan poza dakarkidazuelako
dezente hobetu zait egoera tamala,
irudikatzen  dudanean zuen irria,
leotzak dirudi askatasunaren sala.

2

Aisialdian kirolean edo ikasten
argi daukat bikaina dela  zuen ganora
kontatzen dizkidazuenean balentriak
“maite zaituztet” sentiera dator gogora,
kartzelan galdu dudanez hainbeste bizipen
zuekin egon nahi nuke noizbehinka gerora,
ekaitz larria noizbait atertuko delako,
osaba izan nadin geure Jon eta Nora.

2014ko abuztuaren 31n

## 391
## Homo Sapiens sapiens garelako

1
Neandertalak hagari gehitu zion landutako silexa,
egingo zuen onerako edo agian txarrerako,
zeraman lantzari esker zerbait erraztu zitzaion jarduna,
asmatutako armak zirudien bikaina ehizarako,
gertu edukita lasai zebilen izoztearen aroan
eraginkorra izan zitekeelako defentsarako,
zoritxarrez eskasiak behartuta erabil zezakeen
ondoan bizi zaitzaketen beste leinuen nekerako,
horiek adimena baino gehiago instintua zerabilten,
okerrerako zen euren arteko harremanetarako,
indarra erabilita hartzen zuten leizerik lehorrena,
hori zegiten behar zutelako babes bat negurako.

2

Milaka urte geroago darraigu txarki indarkerian
armak ekoizten dira nazio ahulen konkistarako,
estatu miserable batzuek dagitzate aberasteko,
gizatasuna lurpetu zuten egoistak direlako,
elkartasunaren ordez gudaren hizkuntza dantzugu ozen,
Israel horrelaxe mintzatzen da esate baterako,
Palestinan ideologia sionista maizko darabil,
inperioaren alde eta bakearen kalterako,
Homo Sapiens sapiensak ezin du onartu
Gazako triskantza,
ezin dugu amildu zentzua eroen mesederako,
bortxa izan ez dadin bankari ankerren irabazpidea,
balak nonahi gera ditzagun gure haurren onurarako.

2014ko abuztuaren 31n

## 392
## Euskal preso politikoen abokatuak

1
Abokatuekin gara
esperantzan bizitzen,
lerden ari direlako
amnistia goritzen,
kartzelen zoruan dira
arduratsu higitzen,
zigor latzak dizkigute
bisitetan eztitzen.

2
Auzitegian dabiltza
usu abokatuak,
gu babesteko unean
direlako prestuak,
aspaldi dauzkate kontra
beltz diren Estatuak,
mugatu nahi lituzkete
lotuz bilur estuak.

3
Amets berberak ditugu
gauero edukitzen,
horregatik dizkiegu
bihotzak irekitzen,
konponketa dihardugu
batera eraikitzen,
Euskal Herriko arimak
urratsekin hunkitzen.



4
Ankerrek nahiago dute
gatazka elikatu,
abokatuen kaltetan
mendekua hedatu,
batzuk atzitu dituzte
besteak mehatxatu,
nahi liekete kartzelan
adorea xehatu.

5
Jakinduria digute
betidanik opatu,
horri esker bikain gara
kartzelan defendatu,
buru-eskaintza nahi dugu
atseginez aipatu
dagiten lan erraldoia
pozarren txalokatu.

6
Bakean laga ditzala
juje guda zaleak,
lagun finak direlako
onuraren aleak,
zapalkuntza du agintzen
erroi miserableak,
arren, ebats diezaiola
boterea eleak.

7
Abokatuekin gara
goizean elkartuko,
irri politek gaituzte
gozoro agurtuko,
mintzalekuan diegu
arreta eskertuko,
musu alaien urtean
ditugu ondratuko.



8
Zuek bai gizaki duinak!
beti prest laguntzeko,
sufritzen ari denari
fereka eskaintzeko,
hona etortzen zarete
egoera ontzeko,
askamenaren xedea
gurekin ehuntzeko.

2014ko irailaren 7an

## 393
## Hedabide batzuen kontrako salaketa

1
Hedabide batzuk jakobinoen
aurrean daude adi kokoriko,
geurea herri bat ez dela  hitz
lausoekin diete erakutsiko,
horregatik ez dut Hollande zein
Rajoyren aldeko den ezer erosiko,
“irabazle-galtzaile” mantra
ahoskatzen duen irratirik jarriko,
giza eskubideen bakea ez delako
mendekuaz etorriko,
hautatzeko nahia ez dugulako
telebista horiekin iritsiko.

2

Ez dut prostituzioa iragartzen duen
kazetarik onetsiko,
feminismoak ez luke zoko horietan
ikur morea eskegiko,
begirunerik erakusten ez dutenez
gure nortasunarekiko
holako kobatan ez nuke inoiz euskal
produkturik iragarriko,
nahiz hipokrita horiek dioten
ereduzkoak direla etikoki,
euren egoitzatan kapitalismoa
gurtzen dute apal belauniko.

3
Ez-demokratekin bazabiltza ez
dut gutarra zarenik sinetsiko
deserriko herkideak ez dituzu
horiekin etxera ekarriko,
sistemaren ideologoekin ez da
asaben elea biziko,
ezta herri honek ura beste behar
duen berdintasuna haziko,
bankuen alde daudenekin ez
dugulako onurarik edukiko,
nik ez nituzke iraintzen gaituzten
kazetak eskuetan atxikiko.

4

Ez nuke “Atez-Ate” gaitzesten duen
web atariririk erabiliko,
Ama-Lurra defendatzen dutenak
pozarren nituzke lehenetsiko
kazetari duinekin genioke gogoari
jakintza erantsiko,
aspaldian Estatuekiko dugun
morrontza genuke eraitsiko,
hola berri aratzak genieke arimei
goizera eskainiko,
“herria denok gara” sentimenak
bihotzak lituzke irabaziko.

5
Paris  eta Madrilek orain antzo
dizkigute gezurrak bidaliko,
telebistekin burmuineko neuronak
erabat zirtzilduta utziko,
hobe genuke ez bagenitu logelan
neurrigabe irentsiko,
etxeko atea bagenio adei euskal
kulturari irekiko,
esatariei "Amnistia da zuzentza"
nieke adieraziko,
zuzendariei ez dugula askatasuna
lortu arte etsiko.

6

Hedabideak morroiak izango ez
diren goiztiria da jaikiko,
orduan herritarren heziketa dute
jatorki balioetsiko,
Munduaren albisteak lirateke
egiarekin trebe josiko
utopiara hur gaitezen hitz
zentzudunak lituzkete idatziko,
euskara gaixoak arazo barik lioke
goiari txukun eutsiko,
adierazpen askatasuna lokabe,
litzateke zutik ibiliko.

2014ko irailaren 14an

## 394
## Isolamenduko horma

1
Horma zatar pila daude,
hau da kartzelakoa,
kolorea du grisaxka,
porlan petralekoa,
aurrean dago isilik
delako halakoa,
ihes egin ez dezagun
jaso zuten trinkoa.

2
Zemaika dago hormaren
gainean altzairua,
bera soilik da jendarte
sorraren aierua,
arantzek dute beltzuri
bihurtu ingurua,
dirudi ari direla
sastakatzen zerua.

3
Isolamenduan denez
jabea hoztasuna,
hazten zaizkigu estresa
eta samintasuna,
horma sendoen ostean
ei dabil ontasuna,
hemen nekez edukiko
dugun gizatasuna.

4
Ziegan gaude ia-ia
hormarekin berbetan,
hola daude kide batzuk
etsi gabe urtetan,
gogoak ontzen ditugu
jardun atseginetan,
batik bat zuekin batzen
garenean letretan.

5
Idazten ari natzaio
gobernu kaskarrari,
gatazka sutzeko asmoz
zuloan gauzkanari,
zapla esango nioke
barne ministroari,
jar diezaiola horma bat
salako leihoari.

6
Horma eta zigor latza
daudenez uztartuta,
batzuetan jaikitzen naiz
zeharo nekatuta,
bolalumaz burua dut
sentitzen babestuta,
irudimena tarteka
landuta lasaituta.

7
Nahiz argia kentzen didan
ezin dut gorrotatu,
kaltetzen nauela nuen
tamalez baieztatu,
zokoan beharrez hartu
nuenetik ostatu,
konturatu nintzen hobe
dela xarma sustatu.

8
Ilargia dago horma
eta bion artean,
dirdira garbi eskainiz
igaro bitartean,
ilunki nagoen arren
itxita erbestean,
esperantzak sustraitu dit
poza begitartean.

2014ko irailaren 21ean

## 395
## Erregu bat maitasunaren izenean

1
Zahartzean sartu ez naizen arren
burua eskas sentitzen dut,
ia zorabiatu naizelako
ohatzean urduri nago.
Burmuin geldoari zer ote duen
galdekatzen ari natzaio,
azal diezadan nola zeratu den
estutzen nauen ondoezak.
Kopeta estresa dela medio
gandutu zaidala dirudi,
irakurtzen nagoenean berriz,
begiak lar erretzen zaizkit,
eta saminak maiz inguratzen nau
kezkekin hasten naizenean.
Gorputzaldi txarraren eraginez,
kemenik gabe narras nabil,
giharrak sasoitsu dauzkat ordea
kirol ariketei esker.

2

Zugandik urrundu nindutenetik
minduraz gabiltza urtetan,
horregatik “batuko gara” diot
itxaropenari eusteko.
Borrokan nabil bizitzaren alde
oro maite zaitudalako,
ahalegin hori dagit aldiro
osasuntsu ateratzeko,
enarak lez itzuli gura nuke
zeure zeruan hegatzeko.
Goiztiriaren zohardia nahi dut
zeurekin gozo konpartitu,
ajea errazki lurrunduko zait
zorionaren egunean,
ametsetan agertzen zarenean
hunkituta esaten dizut,
“ez nazala heriotzak eraman
zu berriro ikusi barik”.

2014ko irailaren 28an

## 396
## Berdea, morea, gorria eta zuria

1
Kolore berdea eta morea prezatzen ditut,
berdea delako esperantzarena,
morea berriz jendartea errotik hobetzeko
premia dugun feminismoarena.
Gorria eta zuria zentzu berekoak dira,
gorria munduan da iraultzarena,
zuria berriz sufritzen ari den lurralde honek
erdietsiko duen bakearena.

2
Laurak ederkiro josita ikusi nahi nituzke
ikurrina xumearen ehunean,
elkartasunaren zoruan aratz egon daitezen
herri duinen banderen aldamenean.
Koloreak estatuen eraginez histen dira
burugabe etsaitzen dituztenean,
berdintasunaren garaian bizituko baitira
dilindan egunsentiaren unean.

2014ko irailaren 28an

## 397
## Zentsuraren esparruan gauzkate

1
Kartzelan biluz gaude, zentsurak
larrutzen gaituelako,
sasi-juezekin eskubideak
janzki barik daudelako,

ideia batzuk koba honetan
zapuzten dituztelako,
izorratzeko bada edozein
aitzakia dutelako,
haserre nago aldizkariak
jaso ez ditugulako,
LABek herrira gaitzaten lema
inprimatu duelako.

2

Zuzendariak prest dauzka beti
artaziak zorroztuta,
horrela nekez egon gaitezke
ganoraz informatuta,
hamaika ikur eta kazeta
uzten  ditu giltzatuta,
bere jarrera faxistarekin
gaude oro txundituta,
demokrazia  gaixorik dago
gezurrekin izoztuta,
hor nonbait horren apeten mende
katerekin bahituta.

3

Geure aldeko mezuak dira
hauentzat jasanezinak,
noiznahi dabiltza minki jazartzen
maitasunaren laginak,
euskal kulturak jasaten ditu
mespretxuaren irainak,
bortxan eroso bizi direnen
erabaki kaskarinak,
zorionez ez gaude lur jota
maizko datoz lagun minak,
egun latzetan arimak pozten
dizkiguten pinpirinak.

4
Andre ta jaun ezjakin hauen
langintza baita zabarra,
hantuste hutsak direnez euren
jokaera da lakarra,
euskara hemen arrotza denez,
dirudi dela abarra,
deiturak nahita oker esanda
jotzen digute adarra,
gaur sentitzen dut borbor gogoan
oihukatzeko beharra,
“ez diguzue inoiz kenduko

nortasunaren zuztarra”.

2014ko urriaren 5ean

## 398
## Diziplina ekinez arintzen dugu

1
Murrizketak lartxo handitu dizkigute,
eskubideak  aldi berean txikitu,
Euskal Herritik at gauzkatenez itxita
diziplina burugabea da gurekin
pizgarri bat behar dugu ongi eusteko,
ziegan denbora zentzuz aprobetxatzeko.

2
Herriko indarra sumatu dugulako
gogoa suspertu zaigu, estresa hustu,
ilunpera argia iritsi delako
nasaitu dugu estutzen gaituen soka,
ekinez zigorra zaigulako arintzen
udaberria arnastuz esnatzen gara.

2014ko urriaren 5ean

## 399
## PUERTO I kartzelan bururatu zitzaidan

1
Gaur, atzo eta arainegun bezala,
zu ez zaude irribarretsu alboan,
eta bihar, etzi edo etzidamu
seguru nago ez zarela egongo,
zugandik urrun jaikiko naizelako,
maiteminez, ziega ñimiño batean.
Leihoak zortzi barra dauzka bertikal,
xafla  sendo bi jarrita horizontal,
metalezko ateak erdian dauka
behatxulo txar bat zelata nazaten,
senti dezadan egoera eskasa,
halaber bizitza oro mugatuta.

2

Mahaitxo bat daukat zeuri idazteko,
panel txiki bat zeure argazkientzat,
gorputza espetxean dagoen arren
sentimendua dabil arin hegazka.
Itxaroten dut noiz edo noiz batera
esnatuko garela zorionean,
leihotik dir-dir sartuko den argia
sentituko dugula gozo larruan,
sufrimendua gogotik egotzita
onura  irazekita bihotzean,
zelatarien behatxulorik gabe
biok lokabe irrikaz bizitzeko.

2014ko urriaren 12an

## 400
## Sindikatu belaxkak izan daitezen gorri-gorriak

1
Sindikatu belaxkak hori-horiak dira,
Paris eta Madrilen esanetara daude,
gu ez garela herri bat diote zatarki
internazionalismoa txarto ulertuta,
batzuk lotsagarri dirutu dira zergekin,
beharginen prestakuntzarako laguntzekin.
Denon kalterako erraz zituzten limurtu,
krisiarekin dirudi direla beldurtu,
eskubideak dituztelako ia urtu,
jubilatuen pentsioak lartxo uzkurtu.

2
Borrokatu beharrean iraganean lez
klase diferentziak zuzen ezabatzeko,
kapitalaren morroiak bilakatu ziren
adorez lortutako onurak gal ditzagun.
Hola ezin baita handikien grina hoztu
bankari aseezinen joera izoztu,
arren, bazter dezatela sator lan lizuna,
josteko euskal sindikatuen batasuna,
txit gorria izan dadin krabelin kutuna,
maiatzaren lehena beharginen fortuna.

2014ko urriaren 12a

## 401
## Aska dezagun Europa

1
Zeusek bahitu zuen
Europa neskatoa,
zezen baten antza hartuz
jartzeko lakioa,
matxistak lez portatu zen
ustezko jaungoikoa,
ederra zenari zion

zatartu gaztaroa.

2
Grezian sortu zituzten
horrelako mitoak,
aipatzeko botereak
zeuzkan grina gaiztoak,
tamalez lotuta darrai
emakume petoak,
bankariak direlako
orain jainko trastoak.

3
Europari dizkiote
alabak maiz bortxatu,
semeak aldiro guda
zelaietan sastatu,
ankerrek ziotelako
bizinahia zanpatu,
argia nahi du isiotu,
xarma berreskuratu.

4
Europaren izen ona
arras dute zikindu,
handikiek zutelako
gizatasuna mindu,
milaka herri zituzten
monarkiek hebaindu,
kulturak eta hizkuntzak
mehatxuka erkindu.

5
Europak gogoan ditu
lehengo bizipenak,
bere lurrak zirenean
baketsu herrienak,
garai haiek izan ziren
seguru hoberenak,
bi mundu gerrateenak
duda barik latzenak.

6
Europak bizi nahi luke
lurraldean lokabe,
mugak errotik kenduta
arrazismorik gabe,
ez du gehiago izan nahi
nortasunez herabe,
baizik ideologia
askatzaileen jabe.

7
Euskaldunok maite dugu
herri duinen Europa,
horregatik nahi diogu
askatasuna opa,
eraitsiko dugulako
armaden behaztopa,
arimek egingo dute
kopak altxatuz topa.

8
Feminista izan dadin
herritarren ahotsa,
tinko bezatuko dugu
zeustarren bihotza,
demokrazia ereinda
haziko da pagotxa,
Europak beztituko du
apalki ereinotza.

2014ko urriaren 19an

**402**
**1974. urteko abenduaren 4an gertatu zen**

1
Gaztaroan parte-hartu nuen lehen protestan
kasernan amaitu nuen izututa,
guardia zibil batek “pipa” jarri zidan tripan
ez higitzeko zakar oihukatuta,
Francoren diktaduran ikasleen eskaerak
politikoak lez zeuden ukatuta,
jasotako tratua txarra ez zen izan arren
bihotza sentitu nuen uzkurtuta.



2
Aitxari esan ziotenean gertatu zena
kasernara igo zen arduratuta,
orduan jakin izan nuen familiartea
zeukatela ezlekuan fitxatuta,
egun horretan kontzientzia ernatu zitzaidan
zapalkuntzaren kiratsa sufrituta,
hamasei urte nituen, aitxak berriz zituen,
iaz nituenak Puerton giltzatuta.

2014ko urriaren 26an

## 403
## Urte Berrian Urkon bilduko gara

1
Urtarrilaren lehenean bakarrik esnatu naiz Urkon,
gogoz egin du topa neure sentimenduak,
aurreneko aldia izan da kartzelan nagoenetik
berri on bat eman zigulako abenduak (*),
horrelaxe egon nahi nuke aurrerantzean tontorrean
suspertu bitartean eskubide hilduak,
talaia ederretik dakusat dir-dir goiztiria hasten,
“itzuliko haiz”, esan dit ziur sentiduak.

2
Sorlekuan ezinezkoa zen ezer egin barik jasan
mindu gintuzten frankista ohien aginduak,
astebete egon ziren kartzelak euskal presorik gabe
boterean zuelako jarraitu ganduak,
trintxerak ixteko eta gatazka demokratizatzeko
egiten ari garenez merezimenduak,
Urte Berria biziko du herri honek aurki lokabe,
mendietan bilduta arima ondraduak.

(*) Mikel Zarrabe aske geratu zen

2014ko urriaren 26an

## 404
## Cintruenigoko parke tematikoa

1
Cintruenigoko txokotik
dator albiristea,
bertan txartu dutelako
herriaren eitea,
eskolan bihurtu dute
kaserna etxartea,
zabal-zabalik lagata

“zibilei” atea.

2
Carmen Albak egin die
auzapezaz harrera,
guardia zibil zakarra
horientzat da onbera,
jardun  beharrean belzten
haurren sen alegera,
irakats diezaietela
armen ordez euskara.

3
Argazkian  ikusi dut
parke tematikoa,
ezkutua, ke-potea,
borra eta kaskoa,
ez da Gabonetan jartzen
duten horietakoa,
baizik eskola batentzat
gustu eskasekoa.

4
Haurrak algaraz dabiltza
trepetei behatzen,
helikoptero berdean
sartzeko irrikatzen,
sirenotsaz dihardute
koitaduak  txoratzen,
argi urdinen distiraz
gaiztoki maneiatzen.

5
Horko zuzendaritzak du
zentzugabe jokatu,
errepresioa  ezin
delako goraipatu,
eskola gizatasunaz
behar da gerizatu,
Nafarroa hobe dadin
enpatia sustatu.



6
Cintruenigo aritu da
bortxa erruz ondratzen,
eskolako helburua
lotsagarri aldatzen,
herriak dira gorpuzten
harremanak zeratzen,
eskubideetan haurren
heziketa eratzen.

7
Nafarroako eskuinak
herria du iraintzen,
euskaldunen nortasuna
behin eta  berriz mintzen,
ergelki mintzatu barik
jendartea ozpintzen,
has dadila eskoletan
aniztasuna zaintzen.

8
Cintruenigo zain itzazu
haurren amets  justuak,
berdintasuna dezala
eman zure ortuak,
ez nahastatu armekin
ikasleen buruak,
nafar ohiturekin blaitu
eskolako zoruak.

2014ko azaroaren 2an

## 405
## Geure askatasuna

1

Autobusetik ustezko askatasuna
infinitua iruditzen zaizu,
tamalez hur dagoen arren urrun dago
guardia zibilekin zaudenean,
itxita zaukate metalezko xafletan
espetxez aldatzen zaituztenean,

bidaian ikusmirak zaitu liluratzen
ortzemuga miraz duzu behatzen.
Mendiak, ibaiak, haranak... dakuskizu,
hiriak eta herrixka xumeak,
zeure txokokoak datozkizu gogora,
malenkonian zara barneratzen,
aspaldian ez dituzulako gozatu
eurekin irrikaz dagizu amets,
desiren eremu zabalean zabiltza,
geroa leihatilatik asmatzen.

2
Helmugara iritsi zara, espetxera,
ez da zaharra baina bai krudela,
isolamenduan zaude leihotik beha,
hormatzar gris bat daukazu aurrean,
zeru zerrenda bat dakusazu gorago
izpiak ziegan nekez sartzen dira,
euren artean dauden altzairuzko hortzek
arima minki zulatzen dizute.
Herrimina ernatzen zaizu bihotzean
argia poliki hasten denean,
txolarreen kantuek lasaitzen zaituzte,
papurrekin eskertzen dizkiezu,
zure bizitza metro batzuk direlako
diziplina zorrotzaren mendean,
arnasa sakon hartuta maizko diozu,
Euskal Herria da askatasuna".

2014ko azaroaren 9an

## 406
## Gantxillarena

1
Gantxilla, zure ohorez
ilaran jarri gara,
Urkusuatik zaitugu
igoko Untzagara,
zapia saman lotuta
hasiko da algara,
iturritik eskuz-esku
arin helduko zara.



2
Gantxilla urez bete dut
euskara sustatzeko,
Eibarko kale sikuak
gozoro freskatzeko,
irits dadin loraldia
natural mintzatzeko,
diglosiaren zulotik
behingoz ateratzeko.

3
Gogotsu edan dezagun
Untzagan gantxillatik,
abia dadin euskara
borrborka zainetatik,
“Eta kitto!” dezatela
entzun izarretatik,
lehen lez diogu garbi
hiriño honetatik.

4
“Eta kitto!”-k eratzen du
“Gantxilla” ekimena,
euskarak eduki dezan
neurriko omena,
beharrerako delako
eibartarra lerdena,
giza katean zaintzen du
zehatz-mehatz ordena.

5
Gantxillarena da ñir-ñir
asmo baten islada,
euskarari emateko
behar duen aupada,
herritarrak ariman du
sentitzen zirikada,
aiurria zuzentzeko
izan dezan parada.



6
Eibarren bi urtean behin
hartzen dugu gantxilla,
prestuki etortzen dira
elkarte bikain pila,
“Eta kitto”-k erakutsi
digu dela bipila,
herritarrekin lortu du
emaitza biribila.

7
Gantxillak udaberrian
jaso ditu zirriak,
eskuetan hartuta du
garraiatu herriak,
otoi, lagun diezagula
baztertzeko nagiak,
euskaraz zipriztintzeko
eibartarren hegiak.

8
Gantxillarena gaur dugu
ederkiro mamitu,
arrakastarekin gara
plazan oro hunkitu,
Eibarren ditugu ondo
gogoak ongarritu,
goizero esan dezagun
"euskaraz da argitu!".

2014ko azaroaren 16an

## 407
## Diziplina ankerraren esparruan

1
Presozain eskasak diziplina hauspotzen duenean
esparru beltzuria bidegabe du itotzen,
gorrotoa hormen barruan astintzen hasten denean
gatibuari dio itxaropena lausotzen,
lar sufritzen ari denari etsipena hazten zaio,
arau gaitzekin atsekabea areagotzen,
ohartzen delako kasernakoak diren terrentekin
bizitza ari zaiola ezlekuan gaiztotzen.



2
Isolamenduan aginduak emateko unean,
katua txoriarekin antzo dira harrotzen,
gatibuak sakonki du menpekotasuna nozitzen,
burmuinean eragin petrala doa errotzen,
ohatzean egoera baikortasunez aztertuta,
ideia on bat ari zaio gogoan umotzen,
“begitartean irribarrea zaidanean loratzen,
agintariari diot boterea ehotzen”.

2014ko azaroaren 23an

## 408
## ESAIT-i

1
Euskal liga, kirol mota bakoitzentzat
txapelketak gustura era ditzagun,
Tuteratik hasita Baionaraino,
Mauleko bazterretik Karrantzaraino.
Paris zein Madrili begiratu ordez
hobe da Euskal herrian lehian jardun,
gureak jarri behar ditugu martxan
Munduan lehiatzeko gero pozarren,
olinpiadetan jator parte hartzeko
gainerako herriak antzo lokabe.

2
Zalekeria ez delako ganora
baizik kirolarentzat hondamendia,
uxatuko dugu grina lar eroa
dakarrelako alienazioa,
kirola izan dadila elkartzeko
eta ez elkar joka haserretzeko,
zaleak lan dezala elkartasuna
burujabetza ereiten jarraitzeko,
ariman atsegina senti dezagun
euskal atorrak kirolari duinentzat.



2014ko azaroaren 23an

## 409
## Ustezko txapeldunaren porrota

1
Podiumetik jausi da
uluka onena,
futbolaren ortzian
izarra zena,
La Rojak zirudien
zelaian herrena,
zaleari, zart dio
zulatu kemena,
Espainian dena
denez adimena,
Felipek duena
orain seigarrena,
iraintzat hartu dute
zazpi golena.

2
La Rojak ospea du
gol barik zimeldu,
Brasilen porrotekin
ziplo usteldu,
kasernetan zaizkie
begiak umeldu,
kamiseta gorriak
erabat ubeldu,
hodeia da heldu,
irria  ergeldu,
bandera mengeldu,
kantua epeldu,
erregeari zaio
hitza zezeldu.

3
Harrotasunak dira
hor nonbait zapuztu,
burukominak hazi
grinak erraustu,
Espainia zelako
futbolaz  lar puztu,
La Rojaren flakiaz
korroka da hustu,
Brasilen hain justu
zaio bart kamustu,
jokoa itsustu,
ondra  odolustu,
magiaren galerak
baitu biluztu.



4
Futbolariek hutsak
dituzte onartu,
lehengo trebezia
zaie kaskartu,
nahiz duela lau urte
zituzten izartu,
kazetari txolinak
gerran dira sartu,
oihuka oldartu,
esanez “zahartu,
zarete baldartu,
diruaz ozartu!”
Espainiari zaio
marka malkartu.

2014ko azaroaren 30ean

## 410
## Sakabanaketa hausteko etorri hintzen

“Espetxean nengoenean bisitatzera etorri hintzen”,
esan ei zuen garbi Josuk parabola batean Judean,
praktika babesgarria milaka lagunek obratzen dute,
sakabanaketaren malkarretan zintzo dabiltza urtetan,
zirriekin ez da amatatu itxaropena gogoetan,
isolamenduak ez ditu euskaldunen begiak ilundu,
nahiz larrutik pagatzen dihardugu zigor madarikatua,
udaberrian ihintzak onduko du maite dugun txokoa.

2014 abenduaren 7an

## 411
## Askapenari (loreak ez ditzaten moztu)

1
Kapitalismo basaren izenean,
berekoikeriak zorrotz manatuta,
familia apaleko soldadua
antzeko jendeen kontra oldartzen da,
ez dutelako nahi garia banatu
loreak ari dira krudelki mozten.
Boterea prestatzen du menpekoa
injustiziak iraun dezan Munduan,
plusbalioa bortxaz defendatzeko,
herri ahulei lurrak lapurtzeko,
langileen aldarriak isiltzeko,
zorigabea ustel dadin kartzelan.
Txorimaloa erabat dirutzen da
gezurrekin isiotutako gudekin,
behartsuak dihardu nonahi erailtzen,
behartsu ezjakinaren tiroekin.

2
“Aberatsaren haurrak aginduko du,
pobrearenak agindua beteko”,
doktrina miserablea lurpetzeko
elkartasuna gura dugu indartu.
Gabeziaren zoldura sendatzeko
zain dezagun haur lañoaren hezkuntza,
ez dadin sekula polizia izan,
ezta militar edo presozain ere.
Inork ez ditzala inon bonbak egin
urrutiko lurraldeak suntsitzeko,
izan dadila trintxera hutsala
eskubide mardulen lorategia,
kartzela bihozgabea ospitala,
kaserna gaitza jakintzaren eskola.
Berdintasuna hedatuko bagenu
loretxoek barre egingo lukete.

2014ko abenduaren 7an

## 412
## Horma bako etorkizuna desiratuz

1
“Isolamendu” hitza entzunda
minki diot “infernua!”,
zerua nekez dakusadanez,
“Luziferren erreinua!”,
airean dabil hormen barruan
mendekuaren kerua,
justiziak ez du ezagutzen
sugegorrien zorua.



2
Hormatzarrak du ohartu barik
askatasuna zanpatzen,
itxaropena zoko grisean
mila zatitan zartatzen,
presoak gaude bere mendean
jabea  dugu salatzen,
nahita delako txarto portatzen
estatua deitoratzen.

3
Kartzelan gaude halabeharrez
handikien mesedetan,
enpresak arras gizendu dira
gure kontura urtetan,
hormak ekoizten dituztelako
zitalki harrobietan,
zigorra dugu lazki pairatzen
gabeziaren ziegetan.

4
“Aurreko horma eraikitzeko
mendi bat dute zauritu”,
goizean ziplo zait bururatu,
berehala naiz larritu,
kartzelak dira toki krudelak
presoak sufritzen ditu,
aspaldi zaigu bizitza histu,
porlan petralaz urritu.

5

Kartzelak jaso ahala dute
natura bortxaz astintzen,
Ama-Lur ari dira birrintzen,
txanponen truke iraintzen,
horma honekin ikusmena da
argi barik bizkor mintzen,
bost metrotara dagoelako
sasoia zaizu erkintzen.



6

Gaur esan diot “ea zaituen
gizatasunak eraisten,
edo zugana gutxienez den
demokrazia iristen”,
“haserre gaude diguzulako
eguzkia lar murrizten,
ilusioa maizko zimeltzen,
gaituzulako bereizten”.

7
Hormen artean nabil korrika
etsipena uxatzeko,
ezlekuetan indartsua den
estresa deuseztatzeko,
etxartera naiz gogoz irteten
kideekin mintzatzeko,
"bihar herrira goaz" esanez,
gogoak kilikatzeko.

8
Kartzela gaitza danba nahi nuke
laga etorkizunean,
bitartean dut erabiliko
denbora modu onean,
sentimendua jorratzen nabil
etengabe garunean,
zuei bertso bat eskaintzeko
horma bako egunean.

2014ko abenduaren 14an

## 413
## Zortzi abizenena

1
Euskaldun euskaldunak dira neure deiturak,
zortzi abizenak eta izena. Bai, eta zer?
Ohiturek iraungo al dute eurei esker?
Lehenago  kenduko dizkigute kateak?
Ez dugu horrela izadia suntsituko?
Euskara horregatik biziko da geroan?
Garrantzirik al dauka ongizatearentzat?
Edo herritarren nortasuna finkatzeko?



2
Abizenen kontuak bospasei mende ditu,
kulturalak edo inposatuak ei dira,
zuk zeuk horrelaxe gura izan duzulako
alda ditzakezu aukeratuz beste batzuk,
nahiz sorlekua borborka sentitu zainetan,
hauta dezakezu nongoa izan nahi duzun,
axola eguneroko harremanak dauka,
bizi zaren lurrak eskaintzen dizun babesa.

3
Abizenen auzian hobesten dut jarrera,
hemen bizi garenon konpromiso garbia,
euskaraz edonon naturalki mintzatzeko,
Ama-Lur zoragarria zintzo tratatzeko,
era horretako abizenak nahi nituzke,
antzinako jentilen izaera dutenak,
auzolanean herri sena konpartitzeko,
klaserik gabeko jendartea gauzatzeko.

4
Abizenen jatorriaz arduratu barik
atsegina hauspotuko dugu karriketan,
Euskal Herria denona izango delako
elkar trukatuko ditugu ilusioak,
larru ezberdinek jantziko dute zorua
aberria gu bezalakoa izango da,
askotarikoa, aberatsa eta duina,
txit solidarioa, euskaldun euskalduna.

2014ko abenduaren 21ean

## 414
## Herriko Tabernak direlako

1
Herriko Tabernen hagak
gura ditu makurtu,
aiherkundeak nahi digu
adorea uzkurtu,
Rajoyk txokor batekin du
ebazpen gaitza  gurtu,
bere apeta delako
konponketa papurtu.



2
Madrilek sarri dizkigu
jabetzak ostikatu,
Parisek antzo nahi digu
geroa sastakatu,
salaketa behar dugu
non-nahi bizkor hedatu,
kendu gura digutena
batera defendatu.

3
Astakeria entzunda
ez da inor isildu,
herrikoen ateetan
tinko baikara bildu,
norbaitek esan du ozen
“ezin gara umildu!”,
juezak ezingo dizkigu
desioak amildu.

4
Bakean laga gaitzala
auzitegi bortitzak,
ez diezazkigula honda
zirrararen zurkaitzak,
Herrikoetan txit dira
ontzen gure bizitzak,
eurekin zentzua dauka
solidario hitzak.

5
Egoitzak garbi babestu
erasoa geratu,
ekinez lortuko duzu
ondarea salbatu,
lurraldea nahi baduzu
egiazki askatu,
asmo bikainen zorua
maitasunez artatu.



6
Arranoa bahituta
nahi gaituzte larritu,
horrela gura digute
esperantza urritu,
Herrikoei eusteko
ardurak konpartitu,
arriskuan daudelako
ukabila zutitu.

7
Lau kaina  eta jateko
zortzi arrautzopila,
Herriko Tabernan sartzen
ari da jende pila,
kideok behar dugunez
ibiltzeko makila,
bertsotan maizko diogu
"diz-diz egon dadila".

8
Herrikora goaz euskal
kantekin hunkitzeko,
bere airean gozoro
euskaraz bizitzeko,
inguru aproposa da
zoritsu sentitzeko,
utopiaren hazia
baitan atxikitzeko.

2014ko abenduaren 28an

## 415
## Maitatu nahi nukeen bati

1
Inoiz ez da berandu izaten berpizteko
egunak keriarik gabe iragateko,
dirua eroki erretzeari uzteko,
itotzen ari zaren putzutik irteteko,
alkohol barik gizaki duin bat izateko,
kalean euskaraz totelka ez egiteko,
geroaren bila zirtzilduta ez joateko
zeure burua berriz tente eramateko.



2
Bizitza delako txukun aprobetxatzeko,
Ama-Lurra sentsuekin oro gozatzeko,
alda itzazu joera gaitzak zentzatzeko,
joan ziren gurasoak bikainki ondratzeko,
badaukazu astirik arima garbitzeko,
herrian dagokizun tokia ez galtzeko,
akorduan daudenekin gauero batzeko,
garaipena pozarren eurei eskaintzeko.

2015eko urtarrilaren 4an

## 416
## Nigeriako neskatoak etxera itzul daitezen

1

Entzun dudanetik berria nago histuta,
"Berrehun neskato Nigerian bahituta",
eskolan zeudelako gogoz burua hezten,
halaber etorkizuna ederkiro josten.
Boko Haram-ek egin du ekintza krudela,
arrazoia da kristauekin gerran daudela,
islamista puruenak omen direlako,
matxismoaren harra barnean dutelako.
Esklabo bihurtuko dituzte zigortzeko,
asmo zoragarriak ankerki lurpetzeko,
jaio direlako soilik ama izateko,
senarraren aginduei men egiteko.

2

Afrikarrek ez dezaten jasan miseria,
ez dezagun bazter bertako biztanleria,
arma saltzailea joan dadila pikutara
Nigerian zuzentzak bakea dezan gara.
Ez daitezela izan kartzela sinesmenak,
ez ditzatela motz neskatoen ahalmenak,
ez direlako jaio matxistak sufritzeko
baizik jakintzari esker aske bizitzeko.
Liliek mardulki euts diezaioten goiari
senak garai diezaiola fanatikoari,
Munduak izan dezan irauteko aukera
argi morea dugu isiotuko batera.

2015eko urtarrilaren 4an

# 417
# Asabak kobetan bizi zirelako

1
Izoztea zenean
sustraitu landetan,
asabak bizi ziren
egoki kobetan,
sua isiotzen zuten
artez sarreretan,
historiaurrearen
aro gordinetan,
gizakia gorde zen
beharrez mendetan,
izadiak eskaini
zizkion saletan.

2
Izoztean izan zen
kultura harria,
tresna, hobi, aterpe...
ekai ongarria,
iaioak ziren zinez
lantzen sukarria,
berdin ehizan hartuta
arma hilgarria,
jakintza irauteko
zenez giltzarria,
koban irensten zuten
hazi hezgarria.

3
Harrobiek dituzte
mendiak astintzen,
bertan dauden altxorrak
betiko birrintzen,
Ama-Lur dugu sarri
bortizki hebaintzen,
asaben iragana
sorgorturik mintzen,
txanponen truke zaigu
arima zikintzen,
gizatasuna oro
gogoan mirrintzen.

4
Dirudienez zu ez
zara nekatuko,
kobak harroki hausten
inoiz asetuko,
horregatik itaun bat
dizut luzatuko,
ausaz bihotza zaizu
zapla samurtuko,
"izoztea berriro
gertatuko balitz,
non lirateke zure
haurrak babestuko?"



2015eko urtarrilaren 11n

## 418
## Dilma Rousseffi begirunez

1
Brasilen lurrundu da futbol txapelketa,
hasiko dira  berriz xextra latzak,
izarrak jadanik ez daude zelaietan,
ezta urrutiko zale belatzak,
herriak beharko ditu bete zuloak
eraikuntzan egin ziren akatsak,
Rio de Janeiron dakuskizu nongura
iruzurrak zertutako lokatzak.

2
FIFAkoek joandakoan laga dituzte
azken jai oparoaren lorratzak,
Dilma Rousseff badakizu zer den justua,
berdintasunerantz eman urratsak,
futbola bihurtu dutelako magia
garbitu ustelkerien kakatzak,
pobrezia ken ezazula opa dizut
fabelak izan daitezen malatsak.

2015eko urtarrilaren 11n

## 419
## “Gizaki berria izateko”

1

Ni ez naiz inor aholkurik emateko
arima belztuta daukadalako,
iraganeko akatsak oroitzen ditut
nahi ditudalako zarrastak josi,
gizatasuna txukun landu gura nuke
joera eskasak hezteko.
Gizaki arduratsu bat izan nahi nuke
kontraesanetan ez trabatzeko,
idealak praktikan jartzeko aldiro
jarri beharrean soilik noizbehinka
funtsa zer naizen da, ez ni zer izan nintzen,
jendartea eraldatzeko nahia.

2

Hurkoekin atseginez jardun gura dut
ez izateko gauero damurik,
iraultza hasten delako etxe barruan
jator ibiltzeko gero kalean,
kontzientziak horrela, hunkituko ditut,
euskaraz xaloki mintzatuko naiz.
Mundu iluna dirdaitsu hobe dezaket
etika edonon erabilita,
norberak beraren nia ondu ahala
onduko duelako  ingurua,
jendartea eraldatuko dugulako
buruan lurra goldatutakoan.

2015eko urtarrilaren 18an

## 420
## Futbola izan dadila armaginak bezain garbia

1
Futbola ez zait gaztaroan adina gustatzen
diruak sustraiak ito egin dizkiolako,
zelaian baldarki masa bihurtzen garelako,
futbolariak ditugulako arras jainkotu,
opioak dagien lez sorgortzen duelako,
lurraldeko arazoak baloian ezkutatuz.
Arimak maizko esaten dit tiraka ordea
"euskal ligak zoragarriro antola ditzagun",
euskaldunen arteko harremana hobetzeko.
Kirola polita delako xaloa denean.

2
Futboletik bizitzea da haur batzuen nahia,
garai hartan zen herriko taldean jokatzea,
Txaltxa-Zelain gogotsu jokatzen genuenean
Eibar kirol Elkartea geneukan bihotzean,
nahiz desio magiko horrek porrot egin zuen
sentieran darrai kamiseta gorri-urdinak.
Gora armaginak diogu nongura egonda,
izarren mailan orbanik gabe dagoelako,
zaleen xarmak Arraten daukanez iturria,
Ipurua bihurtu da mirarien habia.

2015eko urtarrilaren 18a

## 421
## Xabiertxo sentimenduan bizi zara

1
Sentimenduan zaude Xabiertxo,
zurekin naiz maiz mintzatzen,
iraganetik etortzen zara,
orainean gara batzen,
goiz-argiaren printzek gaituzte
Akondian ferekatzen,
lurraldeari opa diogu
zoria koplak kantatzen.



2
Eibar zenuen zinez maitatzen,
hori daukat akorduan,
futbolari on bat izan zinen
Txaltxa-Zelai maldatsuan,
Burgosen egin zen prozesuak
eragin zizun buruan,
ernatu eta sortu zitzaizun
herriko sena ziztuan.

3
Zeure izena eta izana
ohorez ditut goratzen,
konpromisoa garai haietan
zeniharduen garatzen,
Francoren kontra aritu zinen
arduratsu borrokatzen,
lokabe bizi zedin herria
Mundu berri bat eskatzen.

4
Mitxel eta zu bipil zineten
irten Markina aldera,
baserritarrak lez duintasunez
naturan lan egitera,
alai zentozten esne freskoa
sorlekura banatzera,
zuek zeundeten nongura beti
zoragarriro batera.

5
Poliziei hanka eginez
heldu zinen bestaldera,
sasian hasi zinen ondoren
alde batetik bestera,
bizimodua bizkor zitzaizun
aldatu goitik behera,
aitxak eta amak amets bat zuten
“etor dadila etxera”.

6

Urtebetetze data tamalez
ez zen izan alegera,
sanblasen xarma  nekez zitzaigun
inguratu sukaldera,
Ermuan txeraz zuten kideek
laga bihotz sentibera,
Xabier, Eibarren oro genuen
sufritu zure galera.

7
Orain hogeita hamabost urte
heriotza zen gertatu,
gatazka gaitzak zituen lazki
gizaki asko zartatu,
herri xumeak ez zuen baina
hondamendia sustatu,
bortxa estatu bidegabeek
maltzurki zuten hautatu.

8
begi tristeak hiletan ziren
ezinbestean gorritu,
geure gogoan zabiltzalako
kemena zaigu berritu,
urrats sendoak entzun itzazu
pilpira sakon sentitu,
amnistiaren bidean gaude
zurekin gara partitu.

(*) Xabier Gorritxategi Agote
(1954.02.02-1980.02.01)

2015eko urtarrilaren 25ean

## 422
## Maria Servini, Goldaturekin batuko da

1
Goldatzen ari dira oroimena
atseden har dezaten joan zirenak,
halaber iragana arakatzen
zenbatzeko izuaren aztarnak,
ager daitezen klarki errudunak,
frankistek egin zituzten krimenak,
torturatzaileek senti ditzaten
ankerki eragindako saminak,
historiak irmoki zigor ditzan
afusilatzen aritu zirenak.

2
Maria Servini jujea dator
ikertzeko orduko hondamenak,
salatzeko Munduaren aurrean
Francoren oinordekoen orbanak,
faxista bortitzak hamarkadetan
lazki sorraraz zituen orbainak,
Goldatu berarekin batuko da
ikus ditzan urratutako zainak,
mardul bizi daitezen gogoetan
zimeldu zituzten lili bikainak.

2015eko otsailaren 1ean

## 423
## Murruaren aurrean ametsetan

1

Murru gotorra espearen muga da,
esperantza hozten duen  itzala,
gizatxarrak aspaldi altxatu zuen
lurruntzeko irriaren onura,
zerua du bidegabe ezkutatzen,
halaber ilunabarra ebasten.
Ezin dira goiko izarrak miretsi
ezta ilargiaren printzak ere,
begiek ez dute atsedenik hartzen
ez da ziegan atseginik sentitzen,
nahitaez egunak igarotzen ditut
panoramika berbera ikusten.

2
Ortzemuga nahi nuke berriz preziatu,
urte batzuk daramatzat itxoiten,
amets eginez dakuskit goiztiriak
distira bizia ez ahazteko,
mugarik gabe bizitzeko desira
gogoan dut sakon barneratuta.
Sentimenduan irudikatzen ohi dut
askamenaren une magikoa,
zeurekin naiz maizko elkartzen
txokoan
maitasunak gidatzen nau zugana,
akorduan daudelako ederkiro
bilbatu genituen bizipenak.

2015eko otsailaren 1ean

## 424
## Sionistek enegarrenez zauritu dute Gaza

1
Itsasoa da muga
murrua orbaina,
esparruak dirudi
bortxaren lagina,
herrak sastakatu du
Palestina mina,
Gaza bihurtu dute
bonbek hondakina,
Israelgo armada
sor aseezina,
oro ankerki dabil
hedatzen samina.

2
Erruz emendatu da
haurren heriotza,
europarra naizenez
sentitzen dut lotsa,
Gazak nahi du sendatu
oinaze zorrotza,
olibondo aldaxkaz
geratu aihotza,
apal entzun dezagun
senaren ahotsa,
“arren, isil dadila
trumoiaren hotsa!”

3
Europan ez ditugu
ekintzak bereizten,
Dabid dabil ordea
bakea eraisten,
liskar krudelak ez du
errukirik pizten,
sionisten gezurra
ohi dugu sinisten,
Gazari dizkiogu
laguntzak murrizten,
kasko urdina ez da
sekula iristen.

4
Sionismoa nahi dut
erabat ukatu,
konkistarako daukan
joera salatu,
juduak beharko du
Israel zentzatu,
Palestina maitatu
bizitza bermatu,
elkartasuna jaso
murrua puskatu,
herri bien artean
onura landatu.

2015eko otsailaren 8an

## 425
## Gizatasuna versus gerrak

1
Gaza, Irak, Siria, Ukraina, Afganistan...
dar-dar dabiltza Herioen eremuak,
inork eratu zituen herraren ekaitzak,
geopolitikan hobetsi oinaztuak.
Bonba erraldoien leherketen eraginez
izugarriak dira umeen oihuak,
Nazio Batuak ez ditu deitoratu nahi
gerrekin aberasten diren estatuak.



2
Elkartasunak bizkor ekar diezazkigula
sorgor jardunda laga gintuzten zentzuak,
onartu genuenean armen salmentekin
areagotzea etekinak bankuak.
Mundua zoritsu iratzar dadin geroan
zentzatu beharko ditugu gobernuak,
gizatasunak geraraz ditzala liskarrak
ondu ditzan bakeak herrien zoruak.

2015eko otsailaren 8an

## 426
## Sakabanaketa sufritzen dugulako

1
Gaur janaria dugu errefusatuko
kide bat bortxaz tratatu zutelako,
horrelako arriskuen mendean gaude
herrak gotorki dirauen kartzeletan.
Isolamendua jasaten dihardugu
gatazka ez dutelako konpondu nahi,
sakabanaketak xextrak handitzen ditu
bere izaera bortitza delako.

2
Euskal Herritik kanpo zaurgarriak gara,
horretaz aspaldi konturatu ginen,
zorionez ez gaude ziegetan lur jota
euskal bidera igaro garelako.
Herritarren urratsekin bat egin dugu
amnistia ehunduko dutelako.
Sarek bere sarean eramango gaitu
deserritik eskubideen zirrira.

2015eko otsailaren 15ean

## 427
## Euskal Errepublika eratuko dugu

1
Badoa errege borboi zaharra
baina ez dator errepublika,
semeari eman dio koroa
Francok berari eman zion lez,
argazkiak aldatuko dituzte
ezer gehiago alda ez dadin,
jarrai dezan Espainiak agintzen,
herri txikien nahiak birrintzen.



2
Euskal Herriaren desioa da
errepublika eraikitzea,
ez du nahi Frantziakoa ordea
hegoak moztu zizkiolako,
jakobinoak zentralistak dira
monarkak bezain lotsagabeak,
euren kultura  digute ezarri,
euskara ia laga elbarri.

3
Jakobinoak eta erregeak
soberan daude gure herrian,
foruak bortxaz kendu zizkiguten
inposatzeko euren legeak,
iruzurgile horien erruz dugu
sufritu maizko hamaika kalte,
utz gaitzatela bakean batuta
kateak eta armak urtuta.

4
Errepublika libre etor dadin
edan dezagun berdintasuna,
feminismoan dago iturria,
senak ontzeko itxaropena,
monarkak izan daitezela soilik
pauma eta lehoi ederrak,
ez dugulako koroen beharrik
gizatasuna naroki baizik.

5

Gure xedea ez da egoista
ez ditugu nahi lurrak lapurtu,
muga barik nahi dugu bizitzea,
demokrazia txit jasotzea,
munduari beha jardungo gara
hartu-emanak bikain josteko,
iraun dezan errepublika fierrak,
elkartasunak hil ditzan gerrak.



2015eko otsailaren 15ean

# 428
# Susper zaitezela opa dizut

1
Azken urtean duzu
larregi sufritu,
oinaze horrek zaitu
erabat gaizkitu,
ezin zenuelako
herrenka jarraitu,
ospitalera zara
goizean partitu.

2
Deserritik dizkizut
laztanak bidaltzen,
berdin esperantzaren
leihoak zabaltzen,
min zorrotzak dizunez
zerua  estaltzen,
saiatuko naiz gozo
izpiak ugaltzen.

3
Atsekabean gaitu
minak kateatzen,
sastadaka burua
digu aldaratzen,
gandua gaudelako
luzaro pairatzen,
bizitzari diogu
zoria eskatzen.

4
Landa bihur dadila
ziztaden sasitza,
ondu dakizun oro
histu zaizun ditxa,
"suspertu" izango da
gu bion aditza,
kolorezta dezagun
animo murritza.

5
Azkenean dizute
egin ebakuntza,
lor ezazula behar
dugun hobekuntza,
neuretzat zarelako
geroaren funtsa,
aldiro diot “itzul
zaitezela untsa!”.

6
Ospitaleko gelan
zara iratzartu,
lehen helburua da
gorputza indartu,
hitz egin dugunean
pozik nahiz ohartu,
atseginak dizula
gogoa itzartu.

7
Aizu komeni zaizu
hankak prestatzea,
naturaz nahi dut biok
libre gozatzea,
xarmagarria da zu
zinez preziatzea,
sentieran zaitudan
beste maitatzea.

8
Oroitzapena dugu
Arraten astindu,
bihotzean geneukan
beharra berdindu,
hunkipenak ziplo du
arratsa sorgindu,
iretargiak gaitu
astiro losindu.

2015eko otsailaren 22an

## 429
## 2014. Brasileko Futbol Txapelketa gogoratuz

Hegoafrikako Futbol Txapelketaz nazkatu nintzen
telebistaren aurrean nuelako net sufritu,
preso gauzkatenetako batek irabazi zuenez
ikur arrotzez zizkiguten plaza batzuk beztitu,
Brasilen jokoan dagoena aldiz pozarren dantzut
irratiarekin ez zait atsekabea berritu.
Aurten, zapaltzen gaituzten estatuen ordezkariak
burumakur dira txapelketatik laster partitu,
Frantzian eta Espainian espetxean gaudenoi
baitan errotu zitzaigun desira zaigu mamitu,
Euskal herrian bezala deserrian gara lasaitu,
ahoberoak isilduta bizipozez horditu.

2015eko martxoaren 1ean

## 430
## Baskoak egin dezan euskaraz barra-barra

1
Marokoarra izan dadila euskalduna
bere lurraren kulturak aberats gaitzan,
halaber frantziarra edo espainiarra,
gurekin bizi den edozein migratzaile,
ez dezala ahaz sekula jaioterria

ezta oporretan etxe berria ere.
Non-nahi egonda bertakotuko nintzateke,
maitatuko nuke txoko eskuzabala,
horixe genegien lehen Ameriketan
Kantauritik bertara joaten ginenean,
miseriari horrela hanka egiteko
gerrak edo soldadutza ez pairatzeko.

2
Ez dut maite harroki datorrena geurera,
herri txikiak arbuiatzen dituena,
kolonoek lez mespretxatzen gaituenean
sentiera digulako erabat mintzen,
estatuekin apal jarduten duelako
eta ez daukanarekin lotsagabeki.
Izan gaitezen bizi garen lurraldekoak,
konpondu gura dugun denon Mundukoak,
elkartasuna herrien artean josteko
gizatasuna izan dadila haria,
horrela dugu aniztasuna ehunduko,
kolore ezberdinekin Euskal Herria.

2015eko martxoaren 1ean

## 431
## Urtarrilak 10. 80.000 sarekide Bilbon

1
Atseginez diogu
“sareak prestatu”,
“gutarrak ekartzeko
besoak luzatu”,
bat eginez baitugu
samina gozatu,
halaber gogoetan
onura ziztatu.

2
Itsasoan genuen
zabaldu sarea,
oparoa izan zen
atzoko marea,
sakon urpetu dugu
herraren garea,
izan dadin geroan
bizitza barea.

3
Horrenbeste taupada
hainbeste zirrara,
Sarek itsasikara
sortu du gogara,
bits gazia heldu da
naro kartzelara,
iheslariak daukan
bihotz onberara.

4
Laurogei mila lagun
diz-diz arratsean,
hola daude izarrak
goiko baratzean,
ikusi nahi dituzte
laztanak etxean,
oinazeak uzteko
iragan beltzean.

5
“Amnistia!”, entzun dut
Bilbo dirdaitsuan,
itsasoa tantaka
zertu den zoruan,
itsaslaminak dira
hasiko kantuan,
ez daudenak dituzte
bor-bor akorduan.

6
Sarek esan du tinko
“presoak ekarri”,
“bakearen harriak
plazetan zut jarri”,
printzak izan daitezen
arimen pizgarri,
eman diezazkiogun
eskuak elkarri.

7
Sarekin gabiltza
zuzentza eskatzen,
handikien bengantza
klarki deitoratzen,
elkartasuna gaude
bikainki jorratzen,
gatazkaren trintxerak
adorez tapatzen.

8
Ekitaldia dugu
ganoraz amaitu,
asmo zoragarria
ederki konplitu,
urrun daudenak dira
kartsuki hunkitu,
gurekin direlako
itsasoan blaitu.

2015eko martxoaren 8an

## 432
## Charlie Hebdo bizi dadin, berriz erail ez dezaten

1
Agian umoreak salbatuko gaitu,
fanatismoak ziur suntsituko,
“Ni naiz Txarli”, esan duten bezain irmoki
nik diot “zuzen dezagun mundua”,
“Parisekoa izugarria izan da”,
idatzi dut goibelki kaierean,
bortizkeriak bihotzak uzkurtu ditu,
eromenak izua du astindu.
Bakeak irabaz diezaiola gerrari,
gizatasunak kapital gaitzari,
eskubideak naroki ureztatuta
itzaliko dira bortxen txingarrak,
elkartasuna izan dadila gozoro
herrien arteko samurtasuna,
gabezia horrela gaindituko dugu,
pobrezia errotik erauziko.

2

Adierazpen askatasuna gerizatu,
murrizketak non-nahi tinko salatu,
aiherrak izan ez dezan aitzakiarik,
muga izan dadila mesprezua,
Parisen bildu diren gobernu buruak,
aspaldi daukate azpiratuta,
diktaduren zingiretan dago zentsura,
berdin ustezko demokrazietan.
Sinesmenak izan daitezela sendunak,
Lurrean goza dezagun zerua,
begirunez har dezagula fededuna,
neurri berean fedegabea,
egia denez sarritan subjektiboa
apal hausnar ditzagun iritziak
atseginez Txarli nahi dugulako izan
ereingo dugu berbaren ortua.

205eko martxoaren 15ean

## 433
## Xake-Matea amnistiarekin desegingo dugu

1
Eloy Velasco epaile ilunak
enegarrenez usatu du bortxa,
abokatuen kontra oldartu da,
belatzak dagien antzo zeruan,
itxaropena lurrundu nahi digu,
zelai euskalduna basa bihurtu.
Giza eskubidean dagoenez
lurraldeak behar duen basoa,
askatasuna landatuko dugu,
atseginak gaindi dezan izua,
pinu berde arrotzak baztertuta
haritzekin uros gara biziko.

2

“Guardia Zibilak ehizan dabiltza”,
albisteak histu gaitu kartzelan,
basoilarrak dizkigute estutu
goza ez dezagun egunsentia,
argia nahi dugulako ekarri
gaua luzatzera datoz bortitzak.
Iaz “Jake” eman ziguten minki,
atzo “Mate” partida bukatzeko,
amnistiaren piezekin diegu
zapuztuko jokaldia ordea,
Euskal Herriak sakon senti dezan
askamenaren zirrara plazetan.

2015eko martxoaren 15ean

## 434
## Sir William Wallace-i (2014.09.18)

1
Eskoziarren sona
ei dago loretan,
arreta eskuratuz
leku anitzetan,
herriak lerden daude
esne mamietan,
estatu batzuk aldiz
zakar trintxeretan.

2
Europan ari dira
herriak jaikitzen,
muga faltsuak  zinez
zentzuz irekitzen,
bakea hizketan da
zuzen eraikitzen,
estatuen arrazoi
petrala akitzen.

3
Irailak hemezortzi
gaitaren soinua,
Sir William Wallace da
"Bai" bozen zeinua,
demokraziak dakar
diz-diz errainua,
urrun lagata laino
beltzen erdeinua.

4
"Bai" bipil dago, ta "Ez",
uzkur ezetzean,
Eskozian ez dira
geratu etxean,
Ezek topa egin du
goiza urratzean,
Baik "hurrengoan" digu
esan arratsean.

5
Emaitzarekin dira
arimak hunkitu,
belardian kardua
ia da hozitu,
“Burujabetzak” ez du
erronka garaitu,
esperantza ordea
ez zaio urritu.

6
Eskoziak aise du
egingo aurrera,
izango duelako
erarik ostera,
herri txikiek dute
biltzeko nahiera,
zirriak eman eta
hartzeko joera.

7
Katalunia, Flandes,
Irlanda, Korsika...
“Herriak gara” kanpai
hotsen errepika,
euskal bidean gaude
eurei jarraika,
orpoz-orpo nahi dugu
hasi aldarrika.

8
Herri duinak bidaide
gara iristeko,
Bruselan askaminak
jator aurkezteko,
borrokatzen gabiltza,
gu geu izateko,
herriñoen Europa
libre marrazteko.

2015eko martxoaren 22an

## 435
## Bizitza delako naturaren (gurasoen) oparia

1
Operazio gelan isil esan dut
“ia nago hirugarren adinean”,
horrelako kontuekin trabatu naiz
ohatilan dar-dar etzan naizenean,

sentiera ilundu zait, zirujauak
anestesia ziztatu didanean,
arrangura gotortu da burmuinean,
ez nuke nahi bizitzerik ezinean,
egoera sakonki aztertu baitut
ebakuntza ondo amaitu denean,
ohitura eskasak bezatuko ditut
lerden jarduteko etorkizunean.

2

Urteak metatzen ari zarelako
presta zaitez sasoia oneratzeko,
gorputza eta burua lant itzazu
dorpeki eta zurrun ez altxatzeko,
bizi kalitatea zaindu ezazu
endekapena bipil atzeratzeko,
eratu egunak aprobetxatzeko
laztan atseginarekin pasatzeko,
otoi, ez esan inoiz berandu dela
naturaren oparia dastatzeko,
erabili bihotza onurarako
zahar ahulen ajeak gozatzeko.

2015eko martxoaren 29an

## 436
## Ederra delako maitasunaren  iturria

1
Bizitzan zehar lili ugari desiratu ditut
baina ez dut kemenik izan  urratsa emateko,
bihotza gozo pilpiratu zait makina bat aldiz,
tamalez ez naiz gai izan “maite zaitut” esateko,
har hori akorduan dago sakonki inkatuta,
agian berandu nabil iturritik edateko.

2

Bizitza bidebanatzez osatuta omen dago,
bat hautatzen duzu besteak nekez iragaiteko,
itzuli nahi nuke ihartzen laga nuen sasoira
gazte harek egin ez  zuena orain egiteko,
atseginak ezinezkoa zena eskainiko dit
neure maitasuna zeure baratzean ereiteko.

2015eko martxoaren 29an

## 437
## Arrasateko Josu Uribetxebarriari

1
Harraparia poztu da Eperra hil zaigulako,
mortuak osasuna lazki kaltetu ziolako,
gorrotoak ospatu du desiratzen zuelako,
barreiaketa horretako eratu zutelako,
kideak tristaturik gaude ondradua zelako,
duintasuna zer den garbi erakutsi zigulako,
zerbait lasaitu gara kartzelan ez zegoelako,
azken hatsa maiteen ondoan eman duelako.

2
Eperra ez zaitez kezkatu zainduko dugulako,
plazak lehen lez euskaraz mintzatuko direlako,
utopia herrian hedatzen ari garelako,
goizero zeure ametsak berresten ditugulako,
amnistiaren zirria sentituko duzulako,
zeure izartxoak dir-dir gidatzen gaituelako,
Ama-Lurraren altzoan zoriontsu zaudelako,
gereziondoa mardul loratzen ari delako.

2015eko martxoaren 29an

## 438
## Barreiaketa: 26 urte istripuak sufritzen

1
Hogeita sei urte jada
barreiaketa pairatzen,
kaltetzen gaituelako
euskal plazetan salatzen,
politika kriminalak
bizipoza du hondatzen,
istripuak eraginda
behin eta berriz kolpatzen,
“Presoak Euskal Herrira”
aldiro dugu eskatzen,
aldeko ahotsak doaz
harrezkero emendatzen,
Sarerekin esperantza
ari gara kulunkatzen,
urtetako lubakiak
karriketan ezabatzen.

2
Enrique Mugicak, metxa
ez zuen soilik isiotu,
PNV asmora
berehala zen lerrotu,
kazeta batzuek zuten
erabakia hauspotu,
lege petrala  herrian
gezurrekin mozorrotu,
Parisen eta Madrilen
estu zutenean lotu,
istripuak zitzaizkigun
bizitzan oro errotu,
nahiz bidaian arriskua
zaigun lar areagotu,
maitasunaren deiak  du
ezinegona girotu.

3
Tamalez bart gertatu da
enegarren istripua,
albisteak laga digu
ahulduta kalipua,
zuzentza itsua denez
agintarien jopua,
Balbek barreiaketan du
inarrosten isipua,
herrari erre dakion
mendekuaren trapua,
elkartasunak egin du
beteko dugun aipua,
“gera ez dadin bidean
zurbil inoren gorpua”,
bultza dezagun presoak
herriratzera lupua.

4
Jendartearen nahiak du
barreiaketa hautsiko,
isolamendua berriz
iraganean utziko,
guk Sarerekin ditugu
hariak trebe josiko,
istripuen garai beltza
batuta dugu itxiko,
sufritzen ari dena da
irribarretsu jaikiko,
preso dauden maiteñoak
direlako itzuliko,
geure taupadekin dira
joan zirenak itzarriko,
askatasuna delako
krabelinekin jantziko.

2015eko apirilaren 5ean

## 439
## Aztarna ekologikoa zaindu behar dugulako

1

“Euskal Herrian erabil dezagun soilik
dagokigun aztarna ekologikoa!”,
izarbel urdina mugatua delako
aldarria irizten zaigu logikoa,
natura hobesten dugulako aratza
praktika  izan dadila horrelakoa.
Urrutiko herrietan baino gehiago
hemengo kontsumismoan dago gakoa,
geure eremua zurrupatzen dugunez,
Lurrak behar luke izan sei halakoa,
grina hutsalei galga jar diezaiegun
txiroak eduki dezan premiazkoa..

2

Ama-Lurren alde prestuki lan dagigu
zaborra dugulako txukun birziklatzen,
petrolioaren ordez ditugulako
energia berriztagarriak hautatzen,
bertako ortu emankorren fruituekin
hasi ginelako aspaldi elikatzen.
Kapitalismoa bota genuenetik
ingurumena ari gara oneratzen,
gu ez gabiltza handikiak zebiltzan lez
urrutiko ondasunak gutiziatzen,
erakutsi diegulako umeei
aztarna zainduz dela natura maitatzen.

2015eko martxoaren 12an

## 440
## Zoriona konpartituz alai biziko gara

Zergatik ditugu ondasun materialak lehenesten
eta espirituaren aholkuak ahazten?
Zoriona kontsumoak dakarrela uste dugunez
goraino beteta daukagu etxeko ganbara,
oporretan pozarren goaz ahalik eta urrunen
baina gero drogak hartzen ditugu baretzeko,
autoa bihurtu dugu bizitzaren erdigunea,
gizakiak  baino gehiago gara banakoak.
Ez gara konturatzen gu izadia garela ere,
suntsitu ahala arima tristatzen zaigula,
bizi gaitezkeela hobe daukaguna konpartituz,
ederra dela maiteaz mirestea arratsa.



2015eko apirilaren 12an

## 441
## Iribasen sega kamustuko dugu

1
LOMCEk autonomia
klaska du zartatzen,
Euskal Curriculuma
eskolan zanpatzen,
Madril dabil aspaldi
legea eratzen,
Werten asmo iluna
geuretzat prestatzen.

2
Gasteiz ta Iruñea
LOMCEren zerean,
bertan dakuskit baina
ez era berean,
Iribas pozik dago
horko aldarean,
Uriarte amore
emanda parean.

3
Iribas Tafallako
herrian zen sortu,
tamalez Iruñeko
OPUSen sorgortu,
Nafarroa lezake
horrek bihur mortu,
historia ordeztu
LOMCEaz elkortu.

4
LOMCE baliatuta
jo du erasora,
irakaskuntza itzul
dadin frankismora,
liburu batzuk  ditu
jarri hankaz gora,
ez daitezen geletan
euskal mapak lora.

5
Iribasek dakartza
Madrilgo mitoak,
zimel daitezen nafar
ohituren hostoak,
ondarearen kontra
dihardu gaiztoak,
gidatzen diolako
sena gorrotoak.

6
Iribas aritzen da
zubiak lehertzen,
euskaldunen arteko
tratua okertzen,
gau eta egun dabil
ikurrak  baztertzen,
aniztasuna zer den
ez baitu ulertzen.

7
UPN euskara
dago zarratatzen
gezurrekin bertako
kultura hondatzen,
LOMCE dabil nonahi den
zakar inposatzen,
behin eta berriz herri
zaharra ukatzen.

8
Iribas urrun dago
LOMCEren kaltetan,
Barcina lez ei dabil
Madrilen penetan,
kultura biziko da
libre eskoletan,
euskara atseginez
haurren mingainetan.

2015eko apirilaren 19an

## 442
## Ezlekuan egunak xukutzen ditugu

1
“Espetxean denbora balia ezazu”,
gogoak diost jaikitzen naizenean,
neure ahalmenaren arabera dagit
kideek euren aldetik dagiten lez,
“orduak geldo doaz”, esan beharrean
osoki xukutzen ditugu egunak.
Nabaritzen da bizitza maite dugula,
geure lurraldearen askatasuna,
zigorrari irabazi diogulako,
begietan igartzen zaigu zirrara.

2

Korrikan, irakurtzen, idazten, ikasten...
uneoro gaude zergura egiten,
jakinduria darabilgu trukatzeko
etxartera ateratzen garenean,
geure bazterrei buruz berba dagigu
hamaika bizipen aipatzen baitugu.
Kontzientzia iraultzaileak eskatuta
eratzen dugu denbora ezlekuan,
ez zaigulako inoiz bihotza erdoildu,
Euskal Herrian bikain biziko gara.



2015eko apirilaren 26an

## 443
## Katuen instintua

1
Geure aitxa zenak zioen txantxetan,
“katuek ez dute ezer aurreratu,
ez dira gai aterpe bat altxatzeko,
neolitikoan lez bizitzen dira,
eguzkiaren orduetan etzanda,
gauekoetan ortziari begira”.
Guk eboluzionatu dugu”, diogu,
ustez antzinan baino hobeto gaude,
nahiz lan dagigun txanpon batzuen truke
izerdia kontsumitzen sikatzeko.

2

Katuak geure kontura jaten baitu
miauka dihardu horretarako,
ezer eman barik eskatzen duenez,
“hauxe bai izaki alferra!”, diogu,
baina katuak ez du natura txartu,
ezta Mundua gerrekin sutu ere.
Beharbada ez dugu kontuan hartzen
bere adimena instintua dela,
mendetan izan du joera berbera,
felidoak Lurrean iraun dezala.

2015eko apirilaren 26an

## 444
## Mirentxin Aurrekoetxea zenari

1
Kilometroak dabil
Mirentxin urratzen,
ontasunez dizkigu
irriak opatzen,
furgonetak ohi ditu
seguru gidatzen,
berari esker gara
garaiz ailegatzen,
nekea leun digu
astero beratzen.

2
Mirentxinak dabiltza
prestuki jaietan,
inposatu ziguten
sakabanaketan,
kemena daramate
ibilgailuetan,
jaso dezaten lagun
minek bisitetan,
Euskal Herritik urrun
dauden kartzeletan.

3
Mirentxin eratu zen
senak eskatuta,
egoera ikusten
zelako txartuta,
bere xedea  zeukan
garbi zehaztuta,
kartzelen politika
laga sikatuta,
presoen belardia
ihintzez blaituta.

4
Mirentxinek dituzte
birrintzen harriak,
errepidean mozten
sasidi sarriak,
musu-truk dagitzate
bidaia larriak,
hobetu senideen
patu lazgarriak,
oro maite ditugu
bihotz ongarriak.

5
Madril eta Parisek
daukate bastoia,
oinazea ziztatzen
dabilen puntxoia,
Mirentxin zenak zigun
eskaini sasoia,
jator idatzi zuen
bidaien gidoia,
aise gaindi dezagun
gaurko maratoia.

6
Mirentxinen izana
dago sustraituta,
izena gogoetan
urrez bordatuta,
ezlekuak zituen
uzten argituta,
presoen sentierak
arras izartuta,
izan zelako grina
gauzka xarmatuta.

2015eko maiatzaren 3an

## 445
## Sarea Sarerekin hedatzen ari gara

Hariak dakartzagu sarea bilbatzeko,
gurutzatuz ta mailak osatuz zeratzeko,
jendartean elkarbizitza oneratzeko,
etxekoen begi eroriak gozatzeko,
mezu baikorra munduan zehar banatzeko,
elkartasuna gero esker onez batzeko,
ezinezkoa omen dena eskuratzeko,
udaberri berrian zoritsu esnatzeko,
barreiaketaren bengantza deuseztatzeko,
urruti daudenak plazetan besarkatzeko,
jaio diren haurrei bakea opatzeko
Sare gu geu garenez zirraraz ospatzeko.

2015eko maiatzaren 20an

## 446
## Kaskarotenea biziko da

1

Turismoaren abagunea profitatuz
jakobinoek finkatu zuten zuztarra,
izan zedin kultura soilik folklorikoa,
frantsesa Lapurdiko hizkuntza bakarra.
Euskaltzaleari Guy Poulou irizten zaio
auzapeza baino gehiago militarra,
itxi nahi du Kaskarotenea ikastola
kenduz ura, babesak eta argindarra.
Seaska pribatua dela da desenkusa,
juezak Paben onartu du hautu kaskarra,
genozidek zalantza barik adostu dute,
eurentzat ele gutxitua da abarra.
Jende hauen erruz hil zorian dagoenez
euskarak dauka geure aupaden beharra,
Ziburu, Herriko Etxetik egotz ezazu
elkarbizitza usteltzen ari den harra.

2

Hamahiru haurtxo eskubiderik gabe daude
Poulouren jokaera delako oldarra,
ikastolari isuna ezarri dionez
arrosaren ordez eman dio laharra,
Gurasoek erasoari eutsi diote
euren kontzientzia ez delako meharra,
Seaskarekin jende zentzuduna bildu da
Kaskarotenea izan dadin nabarra.
Nahiz jasangaitza den ekaitzaren kazkabarra,
elkartasunak dakarkio  ostadarra,
horri esker baretu zaio ezinegona,
bihozgabeak eragindako sukarra.
Irakasleen magia ipuinak direnez,
geletan erraz isildu dute negarra,
Ziburuko antxetek garrasika diote
“haurrentzat izango da uhinen aparra!”.

2015eko maiatzaren 10ean

## 447
## Iazko urriaren 17an gertatu zen

1
Egutegian duzu
arreta paratu,
“hamalau urte jada!”
zara gogoratu,
bihotza dar-dar zaizu
ia minberatu,
poza tarte batean
zapla beheratu.

2
Bost mila egunsenti
dituzu zenbatu,
bost mila ilunabar
kartzelan pairatu,
amesgaiztoa ezin
duzu aienatu,
herrira itzultzeko
atea pasatu.

3
Nahiz eskuak dauzkazun
hertsiki lotuta,
kideekin zabiltza
libre suspertuta,
eurekin hitz dagizu
xarmak gidatuta,
herritarren nahimena
zinez onartuta.

4
Berrogeita hamasei
urte ametsetan,
pilpirika sentituz
odola zainetan,
herrimina ikusten
zaizu ninietan,
aldiro grinaz duzu
islatzen letretan.

5
Kide minekin laga
ezleku zurruna,
hola gerta dadila
biharko eguna,
herria omentzea
da gura duzuna,
naturan etzatea
zu eta kuttuna.

6
Zazpi mila gau egon
zintezke mortuan,
zintzilik orain arte
antzo katiguan,
ostadarra delako
agertu zeruan,
gatazka atertuko
baita sorlekuan.

7
Zeure denbora doa
poliki aurrera,
noizbait zara ordea
helduko etxera,
Sare jaio zelako
zaude alegera,
apal jasoko duzu
arimen Harrera.

8
Bizitzaren laurdena
espe daramazu,
zorionez baikorki
esnatzen zara zu,
goizero gauza bera
eskatzen didazu,
“maitea, irribarrez
itxoin iezadazu”.

2015eko maiatzaren 17an

## 448
## Isolamenduan iretargiari begira

1
Iretargia  kinka larrian ikusi nuen
ziegako leihoaren burdin saretik,
murruan dauden txarrantxetan atxilo zegoen,
hori zirudien ustel den ustetik,
edozein loretxo, zimela iruditzen zaizu
begiratzen  duzunean espetxetik,
urtetan askatasun barik bizi zarenean
tronpa zintezke zigorraren ertzetik.



2
Iretargi betea dakusat liluraturik
txarrantxa biribil baten hutsunean,
kexu nago barra handiei gogor helduta
gatibu dagoelako gauminean.
“Libre ikusi nahi zaitut izarrekin ortzian”,
esan dut arranguraz ziega barnean,
nahiz neuri begira luzaroan egon nahi zuen,
joan ei da amesten hasi naizenean.

2015eko maiatzaren 24an

## 449
## Ebola Kongoko ibai bat da

1
Ebola Kongon dagoen ibai bat da,
izen polit bat hango herritarrentzat,
urak Atlantikoan isurtzen ditu
bizitza hobetuz lur emankorretan
Horrela deitzen diogu birusari
laborria zabaltzen ari denari,
izurri hilgarria abian dabil
jende ugariren gorputzak kutsatzen,
Europan hasi gara dar-dar kezkatzen,
Afrikari ateak gehiago ixten.

2

Sierra Leona, Liberia, Ginea...
elkartasuna eskatzen ari dira,
medikuek hori opatzen diete,
sekularrek eta misiolariek,
tamalez estatu bortitzak  dabiltza

armak saltzen mozkinak emendatzeko.
Ebolak esan nahi du konpromisoa
gerren ordez osasuna bermatzea,
gizakiak baketsu bizi gaitezen,
irain ez dezagun ibai oparoa.

2015eko maiatzaren 24an

## 450
## Zeure suminarentzat botika naturala

1
Sumina gainditzeko
atondu ganbara,
desioak gorpuztu
baretu ikara,
bizitza dastatzera
iritsiko zara,
merezi duzulako
laztanen zirrara,
atseginak dakarren
irrien algara.

2
Estresa uxatuko
duzu izadian,
zaraten kutsadura
lagata hirian,
oneratzeko etzan
zaitez arrastian,
elikatu ametsak
sabai oskarbian,
txepetxak dagien lez
txioka habian.

3
Lehertzen zaizunean
umore zakarra,
sentitzen duzunean
ziztaka laharra,
jantzi  mendiko botak,
txamarra zaharra,
arnasa sakon hartu
gozatu bularra,
Arratetik miretsi
iluntze nabarra.

4
Artizarrak eskaintzen
dizu  aholkua,
iretargiak bris-bris
sorgin errainua,
“Gurutze”-tik dantzuzu
mendien kantua,
oro magikoa den
hontzaren ulua,
musu-truk itzuliko
zaizu sosegua.

5
Naturari gozoro
emanda musua,
iruditzen ei zaizu
guria zorua,
loraldia delako
pozaren zeinua,
erraz egotzi duzu
baiatik mamua,
aladatu zentzu onez
joera antzua.

6
Botika naturalaz
arras xarmatuta,
Arratetik etorri
zara suspertuta,
aztoratzen zintuen
mina osatuta,
kirioak burutik
patxadaz hustuta,
oraina dakusazu
txeraz hornituta.

2015eko maiatzaren 31n

## Aurkibidea, gaiaren arabera.

### Ibonen bizitzari buruzkoak



### Kartzela



### Presoak



### Euskal Herria

**Kultura**



**Oroitzapenak**





**Politika**

# **atara**miñe

**El silencio del infierno**
Fernando Alonso. *2003.*

**Gosea lagun, laguna**
Segapoto kolektiboa. *2004.*

**Kartzelako leihotik**
Joseba Arregi. *2004.*

**Seineri aurrez aurre kontaturiko ipuina**
Joxe Blanco. *2004.*

**Lunaren Goiztiri**
Juan Luis Mugertza. *2005.*

**Azeri gosetia**
Kepa Etxebarria. *2005.*

**Ataramiñe kantuz**
CD. Hainbaten artean. *2006.*

**Claude Gueux**
Victor Hugo (itzulpena: Zorion Zamakola). *2007.*

**Zimaren abenturak**
Belen Gonzalez / Kepa Etxebarria. *2007.*

**Kartzelako neurriak**
Urtzi Zubizarreta. *2008.*

**Mendian gora, mendian behera, Euskal Herrian zehar**
Mahai-jokoa. Zorion Zamakola. *2008.*

**Penumbras de un ayer**
Iñaki Ojeda. *2009.*

**Preso nago**
Mikel Orbegozo. *2010.*

**Bakarmortuko kronikak**
Mikel Antza. *2011.*

**Espetxetik at**
Borxa Urberuaga. *2011.*

**Ametsen txokoan bizi baiz**
Ibon Muñoa. *2011.*

**Ametsen txokoan**
CD. Hainbaten artean. *2012.*

**Kandela bat pizteko behar dena**
Mikel Antza / Iker Moreno. *2012.*

**Fakin xokona**
Oier Goitia. *2012.*

**Sasian barna**
Xabier Makazaga. *2012.*



**Preso nago 2**
Mikel Orbegozo. *2013.*

**Z²**
Mikel Antza. *2013.*

**Agurra eta ohorea**
Jokin Urain. *2013.*

**Ainarak herrira itzuliko dira**
Ibon Muñoa. *2014.*

**Urte ilunak.**
Nelson Mandela (itzulpena: Ekaitz Sirvent). *2014*

**Ilargiraino!**
Mikel Orbegozo. *2015*

**Burdin elorri arantzetan.**
Joseba Arregi Erostarbe. *2015*



**Ibon Muñoa Arizmendiarrieta**
1958.05.18
Eibar

*Ametsen txokoan bizi naiz* eta *Ainarak herrira itzuliko dira* liburuen ildoari eta orden kronologikoari jarraitzen die liburu honetako bertsoek. 142 bertso eta olerki berri. Hasierakoak Puerto I-ean idatziak. Gainerakoak, Kordoban. 2014ko martxoaren 21ean eraman zuten Ibon Muñoa bertara, eta 2015eko maiatzaren 31n idatzitako bertsoarekin amaitzen da liburua.



ataramiñe
www.literaturakoadernoak.org